*2009. urtea ez da salbuespena izan errepresioaz hitz egiten ari garelarik. Egunerokoa izan da, basatia eta fronte guztietan eman dena. Eskuartean duzun urtekarian ezinezkoa izan da gertatu den guztia biltzea, baina ahalegina egin dugu ahalik eta argien azaltzeko zer den Euskal Herrian gertatzen ari dena.*

*Horretarako egunez egun emandako gertaerak argazkien bidez gogoratzen saiatu gara, eta gertaera nagusien azterketa egin dute urtekarian parte hartzeko eskatu diegun idazle eta kazetariek.*
*Mila esker beraiei.*

*Liburuxka honen helburua ahalik eta txoko gehienetara iristea da. Denon esku dago taberna, liburutegi eta webgune ezberdinetan hemengo edukiak zabaltzea.*

*Euskal Herriko Amnistiaren Aldeko Mugimendua*

ERREPRESIOA *DATUTAN* .......... 06

JAZARPENAREN *IRUDIAK* .......... 08

ISILIK EZ DAUDENEN *LETRAK*

*Nire aitaren etxea defendituko dut*
Dorleta Urretabizkaia .......... 010

*Emakumea burdin artean*
Oihana Llorente .......... 022

*.-*
Fito Rodriguez .......... 034

*Errepresioaren hamaika aurpegiak*
Floren Aoiz .......... 046

*Neurrira egindako jantzi estuegiak*
Mikel Albisu "Antza" .......... 058

*Gudariak eta amoranteak*
Iñaki Soto .......... 070

*Recister*
Mikel Peruarena .......... 082

*Remy Martin*
Joxean Agirre .......... 096

KARTELAK .......... 0108



## ATXILOKETAK 2009


*A*txiloturiko euskal herritarrak....0392

*P*olizia operazioetan atxilotuak....0185

*Atxiloketa inkomunikatuak....0137*
*Atxiloketa komunikatuak....048*

*E*kimen eta mobilizazioetan atxilotuak....0156

Adierazpen delituengatik atxilotuak....030

*E*spetxe zigorra betetzeko atxilotuak....021







## EUSKAL PRESO POLITIKOAK 2009

Euskal preso politikoen kopurua....0740
Frantziar estatuan....0166
Espainiar estatuan....0574
Euskal Herrian....07

## Euskal preso politikoak 86 espetxetan banatuak daude

Gaixotasun larriekin:
Espetxean preso:....07
Etxean preso: ....06

Biziarteko zigorra ezarri dietenak: ....055

## Sakabanaketaren eraginak:

Istripuak: ....06
Zaurituak: ....010

## Sakabanaketak suposatu duen gastua:

14.700.450 euro guztira
19.653,00 euro familiako





## **MOBILIZAZIOEN AURKAKO POLIZIAREN ERASOAK** 2009

Jazarritako mobilizazioak..........0161

Mobilizazioen aurkako kargak..........040

Mobilizazioen aurkako kargetan zaurituak..........0144

Identifikazioak..........5000 baino gehiago






## TORTURA 2009

**INkomunikaturiko atxiloketak.......0131**

**Tortura salaketak.......045**

*ERTZAINTZA*

INkomunikatuak.......05

Torturatuak.......01

*ESPAINIAR POLIZIA*

INkomunikatuak.......068

Torturatuak.......040

*GUARDIA ZIBILA*

INkomunikatuak.......015

Torturatuak.......04

*FRANTZIAR POLIZIA*

INkomunikatuak.......043

Torturatuak.......00



# NIRE AITAREN ETXEA DEFENDATUKO *dut*

***Dorleta Urretabizkaia***

Gau hotz hartan, ez nintzen lo hartzeko gai. Begiak itxiak mantentzerik banituen ere, gaueroko ohe alboko ordulariaren hots erritmikoa desatsegina gertatzen zitzaidan. Urduri nengoen, ez nekien zergatik baina nire barruko zerbaitek ez ninduen lasai uzten.

Denbora luzea eman nuen loaren erreinuaren ate joka eta nazkaturik, ohetik jaikitzea erabaki nuen azkenean. Maindire arteko epeltasuna uztearekin batera, oilo ipurdiz jantzi zitzaidan gorputzeko azal biluzia eta ahalik eta azkarren, ate atzean nuen jertse lodia soinean ipini nuen. Etxea iluntasunean murgildua zegoen eta baita isiltasunean ere, ordulariaren tik-tak hotsa baino ez nuen entzuten eta nire pausoek egurrean eragiten zuten karrankarekin batera, sukaldera abiatu nintzen. Hozkailua zabaldu eta esne kaxa hartuaz, trago luze bat eman nion edalontzirik erabili gabe. Amarekin akordatu nintzen orduan, edalontziek zerbaitetarako balio zutela esaten zueneko oroimen zaharrek nire barrua lanbroz beteaz. Eta amaren oroitzapen zaharrak desagertzearekin batera, esne kaxa bere lekuan utzi behar nuenean, egongelatik zetorren hots bat entzun nuen.

Oinak hozten hasiak nituela egongelara abiatu nintzen, anaia bertan egongo zelakoan. Ate alboko etengailuari eragin eta egongela argitu zenean, anaia bertan ez zela ohartu nintzen. Egongela bare zegoen eta zoko guztiak arakatu banituen ere, gauza bakoitza bere ohiko lekuan zegoen. Egongelako argia itzali nuen eta korridorean barna abiatu nintzen anaiaren logelako atea poliki zabalduaz. Logela iluntasunean murgildua zegoen, anaiaren zurrunga hotsak ziren bere presentzia salatzen zuten bakarrak. Ez, anaia ere ez zen izan eta honen logelako atea itxi bezain pronto, komunera abiatu nintzen entzundako hura irudipen hutsa izango zelakoan.

Komunean sartu bezain pronto, konketan eseri nintzen iluntasunean. Pisa gurarik ez banuen ere, bertan geratu



nintzen nire pentsamenduak isiltasun eta iluntasunez bete nahian. Baina oinak izotz blokeak bezala nituela ohartu nintzenean, konketatik zutitu eta pisa egin gabe, logelara abiatu nintzen berriz ere. Ohean sartzear nintzela beste hots bat entzun nuen. Oraingo honetan ez zetorren egongelatik, korridore ingurutik baizik. Une batez nengoen bezala geratu nintzen geldirik, hotsa berriz ere errepikatuko zelakoan baina ez, ez nuen berriz ere entzun eta beste irudipen bat izango zela pentsatuaz, jertsea erantzi eta ohe bazterrera boteaz, maindireen epeltasunean murgildu nintzen berriz ere. Oinak izoztuak banituen ere, begiak itxi orduko, ordulariaren hotsa lotarako lagungarri zitzaidan kantu ederra bilakatu zen eta ohartzerako, loak bere hatzaparretan harrapatu ninduen, atearen hiruzpalau kolpe zatarrek kolpetik esnatu ninduten arte.

Sekulako kolpe gogorrak ziren eta asaldaturik esnatu nintzen. Begiak zabaldu bezain pronto, etxeko sarreratik zetorren anaiaren ahotsa entzun nuen nor da? behin eta berriro galdetzen zuela. Baina atearen bestaldetik kolpeak baino ez ziren erantzuna, geroz eta zakarragoak eta bortitzagoak zirenak. Ordularia begiratu eta goizaldeko ordu biak zirela ikusi nuenean, izuturik, ohetik jauzi batez jaiki eta nire logelako atea zabaldu nuen, eta orduan, zabalik zegoen etxeko atearen aurrean ikusi nuen anaia, lurrean botata. Eta ahoa irekitzeko astirik ere izan gabe, beltzez jantzitako aurpegi estalidun lau gizon armatu gure etxean sartu ziren.

Ahuspez lurrean botata zegoen anaiak eskuak bizkarrean bilurtuak zituela ohartu nintzenean, gelatik ateratzeko agindua eman zidan gure etxe barrura kolpetik sarturiko gizon arrotz haietako batek. Ni erdi lo nengoen eta batez ere, oso izuturik. Eta ez dakit nola, zerbait jazteko beharra nuela esan nion beltzez jantzitako gizonari lurrean zegoen anaiarengandik begirada apartatzerik izan gabe. Gizonak azkar janzteko erantzun zidan ahots zatarrez beste hiruek anaia bortizkeriaz lurretik jasoaz, bere logelara eramaten zuten bitartean.

Nik ohe bazterrean nuen jertsea eta harrapatu nituen lehenbiziko galtza eta oinetakoak ipini nituen ahalik eta azkarren logelatik atereaz. Beltzezko gizonak etxeko atarian jarraitzen zuen, anaia eta beste hiruak berriz, honen logelan ziren. Hizketan ari zirela entzun nezakeen baina ez nuen esaten zutena ulertzerik ezta bereizterik ere. *¿Qué le están haciendo a mi hermano?* galdetu nion aurpegia estalia zuen gizon armatuari. *No pasa nada* erantzun zidan *salga de la casa* esan eta sarrerako atea zabalduaz. Ni zer egin jakin gabe geratu nintzen une batez eta anaiaren logela aldera abiatu behar nuenean, *salga de la casa* errepikatu zidan gizon arrotzak. Nik zalantza egin nuen une batez baina izuturik, etxetik atera nintzen azkenean. Portalera atera bezain pronto, pareko bizilagunak ikusi nituen. Izu aurpegiz begiratu ninduten eta ezer esan gabe, euren etxeko atea poliki itxi zuten. Eskailera batzuk igotzeko esan zidan gizonak eta bertan geratzeko hiru leiho txikiren aurrean.

Esan eta egin. Beltzezko gizonak esandako lekuan geratu nintzen. Eta geldialdi hartan, bihotza oso azkar zihoakidala ohartu nintzen, gorputza dardaraka nuela eta eztarria berriz, beldurrezko korapilo garratz batek estutzen zidala. Etxeko atarira begiratu nuen. Atea erdi zabalik zegoen eta

barrutik zetozen ahotsak entzuterik banituen ere, ez nintzen esaten zutena ulertzeko gai. Beltzezko gizona batetik bestera zebilela ohartu nintzen, geure gauzak begiratzen zituen bitartean, ni ere miatzen ninduela. Eta orduan, urduritasuna sentitu nuen berriz ere, lepoko soka geroz eta estuago izango banu bezala. Izan ere, gau ilunean, ezustean eta bat-batean, gure aitaren etxean sartu baitziren lapurreta egitera.

Ez dakit zenbat denbora emango ote nuen portale hotzean. Minutuak ordu luzeak ziruditen eta lepoko sokak itota, lasaitu egin beharra nuela konturatu nintzen bihotzeko ordu arte nire barruan preso mantenduriko izu eta tentsio guztia kolpetik atera zen, urez beteriko presa bat bat-batean askatuko balitz bezala. Eta oharkabean *¿qué le estáis haciendo a mi hermano?* oihukatu nuen eskailerak kolpetik jaitsiaz.

Leherketaren erdi-erdian nengoela, berehala ikusi nuen beltzezko gizona etxetik atera eta portalean no pasa nada esaten ari zela. Eta beste ezer esaterik izan aurretik, etxeko atea zabaltzen zela ohartu nintzen, bertatik anaia ateratzen zela. Bihotzak jauzi egin zidan kolpetik. Besoak bizkarrean bilurtuak zeuzkan eta burua behera begira zuen bi

**Oharkabean, beregana gerturatu nintzen eta portaletik
esan nion malkoei eutsi ezinik. Begirada azkar bat zuz
hauskorrago zegoela ohartuta, maite zaitut oihul**

batek ematea edota okerragoa oraindik, ni ero moduan jartzeagatik anaiari min ematea nahi ez banuen behintzat. Orduan, bira eman eta hiru leiho txikietako batetik kalea begiratu nuen. Iluna zegoen errepidea eta ez zebilen inor kalean. Hotzak nengoen eta dardarek eraginda arnasa moztuta banuen ere, arnasa sakon hartzen saiatu nintzen. Baina ezin nuen, begiradak etxeko atarira alde egiten baitzidan eta belarriak ere, etxe barruko ahots haietara adi bainituen. Kontzentratu beharra neukan, gauza ederrekin akordatu eta orduan, amarekin gogoratu nintzen, berarekiko sentitzen nuen behar kolosalaz. Eta masailetik behera eroritako lehen malkoa lehortzearekin batera, etxe barrutik zetorren anaiaren ahotsa entzun nuen. Eta une hartan, gizonek besoetatik eusten zioten bitartean. Oharkabean, beregana gerturatu nintzen eta portaletik azkar ateratzen zuten bitartean dena ondo joango da maitia esan nion malkoei eutsi ezinik. Begirada azkar bat zuzendu zidan, izuz beteriko begirada beltza eta sekula baino hauskorrago zegoela ohartuta, maite zaitut oihukatu nion malkoei, minari eta gorrotoari eutsi ezinik.

Berehala atera zuten portaletik auto ilun batean sartuaz. Beranduago gure ordenagailua eta kartoizko kutxa bat zeraman gizon bat atera zen gure etxetik eta honen atzetik, zaindari beltza. Bi autoak martxan ipini eta abiada bizian alde egin zuten ni bakarrik utziaz. Portaleko atarian geratu

nintzen errepideari so. Zarataren osteko isiltasun eta huts beltz hura gainetik kentzerik izan gabe. Errepideak hipnotizaturik izango banindu bezala zen. Masaileko malko hotzek egoera hartatik atera eta neure gorputz dardaratira itzularazi ninduten arte. Aztoratuta sentitzen nintzen, bihotza bere lekutik ateratzear. Ez nekien zer egin, bortxatuta sentitzen nintzen, neure etxean eta bihotzean lapurreta egin izan balidate bezala. Noraezeko egoera hartan, etxeko atea zabalik zegoela gogoratu nintzen eta orduan, amesgaizto batetik esnatu izan banintz bezala etxe barrura abiatu nintzen korrika.

*"Nire aitaren etxea defendituko dut. Otsoen kontra,*
*sikatearen kontra, lukurreiaren kontra, justiziaren kontra,*
*defenditu eginen dut nire aitaren etxea.*
*Galduko ditut aziendak, soloak, pinudiak; galduko ditut*
*korrituak, errenteak, interesak, baina nire aitaren etxea*
*defendituko dut. Armak kenduko dizkidate,*
*eta eskuarekin defendituko dut nire aitaren etxea; eskuak*
*ebakiko dizkidate,*

**azkar ateratzen zuten bitartean dena ondo joango da maitia zendu zidan, izuz beteriko begirada beltza eta sekula baino katu nion malkoei, minari eta gorrotoari eutsi ezinik.**

Guztia hankaz gora zegoen. Anaiaren logelara abiatu nintzen eta tiradera guztiak zabalik zeudela ikusi nuen. Egongelara abiatu nintzen gero eta hura ere, hankaz gora zegoen. Dena jasotzeari ekin nion bat-batean, gau hartan gertatutako hura sekula gertatu izan ez balitz bezala baina aita eta amaren ezkontzako argazkia lurrean botata zegoela ikusi nuenean, anaia lapurtu zidatela ohartuta, sekulako negar gurea sentitu nuen kolpetik. Bihotza birrindurik, lurrera makurtu nintzen poliki eta gurasoen argazkia leuntasun eta maitasun handiaz jasoaz, zegokion lekuan ipini nuen berriz ere. Kaosaren erdi-erdian, aita eta ama behintzat, euren lekuan ipiniaz. Eta gero, haur txikiaren kontsolamendurik gabeko negarrari ekin nion Gabriel Arestiren poemarekin akordatuaz.

*eta besoarekin defendituko dut nire aitaren etxea; besorik*
*gabe, sorbaldik gabe,*
*bularrik gabe utziko naute, eta arimarekin defendituko dut*
*nire aitaren etxea.*
*Ni hilen naiz, nire arima galduko da, nire askazia galduko*
*da, baina nire aitaren etxeak iraunen du zutik."*

Eta nire bizitzako bost egunik luze eta beltzenak bizi izan nituen gero.





## URTARRILAK 03

Milaka eta milaka lagun bildu dira Bilbon euskal preso politikoen eskubideen defentsan.

## URTARRILAK 08

Aurrekaririk gabeko epai batean Estrasburgoko Giza Eskubideen Auzitegiak Espainiar Estatua zigortu du Mikel Iribarren nafarrari kalteordain bat ematera. Presoen aldeko manifestazio bat ke potez erasotu zuten espainiar poliziek eta Iribarren larriki zauritu zuten.



## URTARRILAK 018

Frantziako poliziak Lorea Zeziaga eta Alejo Moreno euskal iheslari politikoak atxilotu ditu Lapurdin.




## URTARRILAK 014

Ertzaintzak lau lagun atxilotu eta hainbat zauritu eragin ditu Zornotzan AHTren eta desjabetzeen aurkako manifestazio batean.

**URTARRILAK 017**

PNVk aurkeztu duen zentsura mozioak Ezker Abertzalea Azpeitiko alkatetzatik kanporatzea ekarri du. PNVren agintaldia Ertzaintzaren karga batekin hasi da Azpeitian.





**URTARRILAK 017**

AHTren aurkako manifestazioa burutu da Urbinan eta Ertzaintzak zortzi lagun atxilotu eta 100 baino gehiago zauritu ditu.




**URTARRILAK 023**

Zortzi militante independentista atxilotu eta 18 miaketa burutu ditu espainiar poliziak Ezker Abertzalearen aurkako polizia operazio berri batean. Zortzi atxilotuak espetxeratuak izango dira.






## URTARRILAK 031

Euskal internazionalistak jasaten ari diren jazarpena salatu dute Bilbon ehunaka lagunek parte hartu duten manifestazioan.

## OTSAILAK 03

Garzonek beste hamairu euskal herritar auzipetu ditu D3M eta Askatasuna hauteskundeetara aurkeztu daitezen ekiditeko. Espainiar Entzutegi Nazionalean deklaratzera deituak izan dira.




## OTSAILAK 04

Jon Lizarribar frantziar estatutik kanporatua izan da espetxe zigorra bete duen egunean. Hainbat egun eman ditu gose greban kanporaketaren aurka. Azkenean libre gelditu da.




## OTSAILAK 05

Iruñeako Iturrama ikastetxean Gudari Egunean buruturiko omenaldi baten harira guztita 17 ikaslek espainiar Entzutegi Nazionalean deklaratu beharko dutela salatu du LAB sindikatuak.

## OTSAILAK 06

Martin Sheinin NBEko errelatoreak Euskal Herrira egindako bisitaren ondoren espainiar estatuak burutzen dituen hainbat eskubide urraketa salatu ditu. Presoei ezarritako biziarteko zigorra, tortura eta legez kanporatzeak aipatu ditu besteak beste.





## OTSAILAK 07

Espainiar Entzutegi Nazionalaren debekuen gainetik Ongi Etorri jendetsua egin zaio Azpeitian Garikoitz Etxeberriari. Lau lagun inputatuko dituzte ondoren espainiar Entzutegi Nazionalean ekitaldi honegatik.




## OTSAILAK 010

Frantziar poliziak bost lagun atxilotu ditu Ipar Euskal Herrian abertzale mugimenduaren finantziazioa ikertzea xede duen inkesta baten baitan.



## OTSAILAK 010

Hainbat gazte independentistak burutu asmo zuten agerraldia zapuztu du espainiar poliziak. 40 lagun identifikatu dituzte, agerraldia legez kanpokoa zela argudiatuz.






## OTSAILAK 013

Hauteskunde kanpainaren lehen egunean propaganda jartzen ari ziren ezker abertzaleko hainbat kideren aurka jo du Ertzaintzak Sestaon. 20 lagun identifikatu dituzte eta batzuk jo ere bai.

## OTSAILAK 013

Torturaren aurkako eguna izanik mobilizazio ugari burutu dira Euskal Herrian. Ertzainak bina lagun identifikatu ditu Leioan eta Gasteizen.



## OTSAILAK 014

Ezker Abertzaleak *Demokrazia orain!* lemapean deitua zuen manifestaldia debekatu du espainiar Entzutegi Nazionalak. Ertzaintzak manifestarien aurka jo du, zazpi atxilotu eta hainbat zauritu eraginez.




## OTSAILAK 015

Arrigorriagako udalak Argalaren ohorezko plaka kendu zutela salatu dute bere senide eta lagunek. Plaka itzultzeko eskatu diote udalari.

## OTSAILAK 019

Bilbon EAJren ekitaldira demokrazia aldarrikatuz sartu diren 15 lagun identifikatu ditu Ertzaintzak.

## OTSAILAK 020

Ertzaintzak bi gazte atxilotu ditu Durangon PPren ekitaldi baten aurrean protesta egiteagatik. Poliziak beste bi lagun atxilotu ditu Portugaleten kartelak jartzen ari zirelako.





## OTSAILAK 021

Amaia Arrieta libre gelditu da guztira sei urte espetxean eman ondoren. Arrasaten Amaiari harrera egitera hurbildu diren ehunaka lagunen aurka jo du Ertzaintzak.



## OTSAILAK 024

Gasteizen Zaramazulo elkartea miatu du ordu luzez Guardia Zibilak. Bertatik propaganda politikoa eraman dute. Bertan zeuden bi gazte atxikita eduki dituzte.






## OTSAILAK 024

Lazkaoko herritar bat bertako Herriko Tabernara sartu eta kalte material handiak eragin ditu. Klase politikoak eta komunikabideek gertaera justifikatu dute.





## OTSAILAK 025

Egun hauetan zehar etengabea da Ertzaintzak Ezker Abertzalearen hauteskunde kanpainaren aurka buruturiko jazarpena. Atxiloketak, identifikazioak eta kargak egunerokoak dira herri eta auzoetan.

## MARTXOAK 01

Ertzaintzak Manex Castro gaztea atxilotu du Villabonan goizeko 3:00etan. Villabonan bizi den etxea eta Hernaniko bere gurasoen etxea miatu dituzte.



## MARTXOAK 01

Hainbat atxilotu eta ehundik gora identifikazio burutu ditu Ertzaintzak EAEko Legebiltzarrerako hauteskunde egunean. Beste behin ere Ezker Abertzalearen hautagaitza legez kanpo gelditu da.

## MARTXOAK 02

Ertzaintza Beñat Aginagalde eta Ugaitz Errazkin atxilotzen saiatu da Hernanin. Beraien etxeak miatu dituzte.



## MARTXOAK 04

Ertzaintzak Mikel Garmendia atxilotu du Villabonan arratsalde partean. Eskualdean irekia duen polizia operazioaren baitan eman da atxiloketa. Espetxeratu egin dute egun batzuetara.




## MARTXOAK 05

Manex Castro epailearen aurrera eraman dute bost egunez inkomunikatua izan ondoren. Ertzaintzaren eskuetan egon den denboran tratu txarrak jasan dituela salatu du.

## MARTXOAK 05

Arratsaldean Ertzaintzak Iraitz Santa Cruz atxilotu du Hernanin eta Plaza Berrin etxe bat miatu du. Espetxeratu egin dute ondoren.



## MARTXOAK 05

Ertzaintzak bost gazte atxilotu ditu Gasteizen egozten zitzaienaren berri eman gabe. Zazpi orduz inkomunikatuak izan ondoren libre utzi dituzte, gazteek deklaratzeari uko egin ondoren.

# EMAKUMEA BURDIN artean

Oihana Llorente

Ilun dago gela. Eta hotz. Bilutsik aurkitzen da gelako bazter batean txiki txiki eginda eta dardarka. Isiltasuna da nagusi eta hala izaten jarraitzea espero du. Baina ez. Hanka hotsak entzun eta atea zabaltzen ari da. Kaputxadun gizonak agertzen dira bera berriz irainduz, kolpatuz, lizunki ukituz, bortxatuz. Estatu espainoleko polizi etxeetan tortura erabiltzen dela aski frogatua dago. Atxilotuen tortura testigantzei eta urtero urtero egiten diren balantze eta datuei erreparatzea besterik ez dago. Tortura metodoak gainera, lortu nahi dituzten helburuak eraginkortasun handiz lortzearren ikertuak eta gaurkotuak izaten dira eta hortaz, ezin da uka emakumeei era berezituan aplikatzen zaizkien tortura metodoak egon badaudela. Hor dugu tortura sexuala. Tarteka gizonezkoen aurka erabiltzen den arren, tortura mota hau bereziki emakumezkoei dago zuzendua. Emakumezkoak, emakume izate soilagatik, jasaten dituzten mota ugaritako irain sexualetatik hasi eta komisaldegietan gerta daitezkeen mota guztietako bortxaketetaraino makina bat errealitate desberdin aurki daitezke tortura sexualaren baitan, asko deskribaezinak. Emakumearen gorputza askotan izaten da kolpatua polizi etxeetan, bai fisikoki eta baita psikologikoki ere. Galdeketak, gehienetan, emakumea erabat bilutsik dagoela  edota kuleroetan aurkitzen dela ematen dira, horrek emakumeari sentiaratzen dion guztiarekin. Euren aurpegia estalita duten poliziak beti dira gizonezkoak eta galderak egiten dituzten bitartean emakumearen gorputza etengabe begiratzen dute, ukitzen zeharkatzen dute, hankak zabaltzera behartzen dute emakumea eta batzutan, mehatxu eta oihu artean, erabat beldurtuak dauden gorputzak muxukatzen eta mihazkatzen dituzte. Lizunki eta erasotuaren baimenik gabeko laztanek emakumea gehiago urduritzen dute eta poliziaren eskuetan igarotzen dituzten bost egun eta gauak etengabeko tentsioan egotera behartzen dituzte. Izan ere, atxilotua dagoen emakumea bortxatua izango delaren ziurtasun osoa izatera heltzen da egoera gehienetan, eta hori noiz gertatuko zai tentsioan igarotzen



ditu orduak eta egunak. Gizonezkoen aurka erabilitako ohiko tortura metodoez gain, emakumeak zapalketa bikoitza sufritzen dute komisaldegietan. Honek ez du esan nahi emakumeak gehiago torturatzen dituztela, desberdin baizik, emakumeen kontra erabilitako tortura sarritan berezitua delako. Gizonekoen atxilo aldietan gertatzea geroz eta ohikoagoa den arren, emakumeei dagokionez umilazio eta irain sexualak etengabe ematen dira egun luzeetan zehar. Emakumearen gorputza izaten da polizien komentarioen iturri nagusia; lodia dagoela, haren gorputzak nazka ematen duela, itsusia dela... Sexualitatea ere tartean izaten da beti eta emakumearen aukera sexualak ere irainen jomuga dira komisaldeagian, erasotua emagaldutzat joz. Eta hau guztia, emakumea ahalik eta ezereztuen uztearren. Lehen esan bezala, torturatutako emakume gehienak bortxatuak izango direlaren uste sendoa dute, izan ere, bortxatua izatearen mehatxua uneoro dago komisaldegietan: Haurdun uztearekin mehatxu; hiru gizonen artean bortxatzearekin mehatxu; HIESarekin kutsatzearekin mehatxu; edota antzu geratzearekin mehatxu. Ugaritan ordea, mehatxuak ez dira horretan gelditzen eta bortxaketa ematen da. Ez dira gutxi polizi etxeetan bortxatutako emakumeak, eta askotan gainera, poliziaren ankerkeriaren erakusle emakumea, tortura-metodo ezberdinen artean aukeratzera behartzen dute: erratzaren kirtena eta polizi baten artean hautatzera behartuak, euren zakila edota pistola artean aukeratzera behartuak. Emakumearen kontrako diskriminazioa ordea, ez da polizi etxeetan abiatzen. Atxiloketa unetik bertatik komunikabideek trataera desberdina ematen dute atxilotutakoa emakumea bada. Errugabetasunerako dagoen ohiko bortxaketaz gainera, atxilotutako gizonekin kontutan hartzen ez diren hainbat elementu bolo bolo zabaltzen dira. Emakumearen ekarpen politikoa izandako bikotekideetara mugatzen dute, atxilotutako emakumearen aukera sexualak lau haizeetara zabaltzen dituzte eta bere fisikoaren araberako komentario sexistak zabaltzen dituzte.

Komunikabideak ez dira ordea, sexuaren araberako trataera desberdina ematen duten bakarrak, justizia ere desberdina baita akusatuen eserlekuan iseria dagoena emakume ala gizona izan. Ama izanda alde egin behar izan zuen euskal herritar baten aurkako epaiketan jakin dugu bere egoera familiarrak delitua larriagotzen duela Frantziako tribunaleen iritziz.

Emakumearen kontra erabilitako tortura metodoak aldiz, ez dute beti bera suntsitzea bilatzen askotan gertatu baita bikotea batera atxilotzerakoan emakumea txantaia egiteko erabili izana. Atxilotutako mutil ugari euren neskalaguna ondoko gelan nola jipoitzen edo bortxatzen zuten ikustera behartu izan dituzte maiz, mutilek hitz egin zezaten. Poliziaren egoitzetatik igaro ostean, agerian ez dauden zauri sakonak izaten dituzte emakumeak askotan. Bertan igarotako bost egunak gainditzea ez da erraza izaten, are gutxiago sexualki erasotuak izandako emakumeentzat. Egoera horietan ezinbesteko izaten da lagun eta senideen aholku, laguntza eta babesa, baina askok ez dute aukera hori eta komisaldegia atzean utzi eta espetxean bahitzen dituzte. Espetxea gauza gehienen gisara gizonek eta gizonentzako diseinatutako errealitate bat da. Emakumeei zuzendutako espetxe bakanak kenduta, Brievakoa edota Alcalako modulua kasu, kartzelak gizonei espreski zuzendutako eraikinak

dira. Emakumeak espetxeratzerakoan ordea, ez da errealitate hau aintzat hartzen, eta edozein kartzelatan sartzen dituzte preso, emakumeek erabili beharreko gutxieneko esparru bat moldatuz. Emakumeak bertan egon arren, espetxeko instalazio guztiak, -erietxea, eskola, ginmasioa, tailerrak- gizonei daude zuzenduak eta haiek dute erabiltzeko lehentasuna. Emakumeak gizonekin topa ez daitezen, instalazio hauek soilik hutsik dauden ordutegian erabili ditzakete. Tailerren kasuan ordea, emakumeei eskaintzen zaion ikastaro aukera urria izateaz gainera, -makramea, joste-ikastero edo ileapandegi ikastaroa kasu- egungo gizarte patriarkalak inposatzen dituen rolak erreproduzitu eta mantentzera dator.

dituzten emakumeak. Zentru medikuan emakumea esku burdinekin egotera behartzen dute maiz poliziek eta beste askotan emakumea polizien aurrean biluztarazi eta artatua da. Ugariak dira halako egoera jasateko prest agertzen ez diren emakumeak eta beraz, zerbitzu medikurik jasotzen ez dutenak.

Emakumezko euskal preso politikoak espetxean bizi duten egoera aztertzerakoan ezin da aipatu gabe utzi dispertsio politika.1987. urtean Gobernu espainolak euskal presoen dispertsioa onartu eta bi urte beranduago aplikatzeari ekin izanak, euskal preso politikoen bizi baldintzak izugarri gogortu zituen. Euren ingurunetik aldentzea presoei zigor gehigarri bat suposatzeaz gainera, euren lagun eta senideentzat ere sekulako kolpea izan zen neurri honen ezarpena, astebururo euren senideak ikusi ahal izateko ehundaka kilometro egiten baitiztutze honek dakarren arrisku eta odoluste ekonomikoarekin.

**Poliziaren egoitzetatik igaro ostean, age emakumeak askotan. Bertan igarotako are gutxiago sexualki eraso**

Preso dauden emakumeak egunerokotasunean kalean eman ditzaketen minutu gutxi horietan ere gizonak baino baldintzatuagoak daude. Izan ere, emakumeei zuzendutako patioak askoz mugatu eta txikiagoak dira. Gehienetan, espetxea eraikitzerakoan, ez zen emakumeei zuzendutako bigarren patiorik aurreikusi eta emakumeek patio gisa erabiltzeko esparruak egokitzen joan dira, mugapen handiekin noski.

Gizonen beharretara diseinatutako eraikinak izanik, espetxeak ez du ginekologia zerbitzurik eskaintzen, ezta emakumeei zuzendutako presondegietan ere. Hilabeteak igaro daitezke kartzelaz kanpoko kontsulta bat eskuratzeko, eta ez dira gutxi hitzordua lortuta ere bertara trasladatu ez

Dispertsio politika euskal preso ororen aurka ezarri bazen ere, emakumeengan eragin handiagoa izan zuen kopuru txikiagoa izanik errazagoa izan baitzen euren artean sakabanatzea. Lehen aipatu bezala, emakumeei zuzendutako espexeak egon arren, emakumezko euskal presoak edozein kartzelatan aurki daitezke sakabanatuak.

Egun 118 euskal emakume daude estatu espainol eta frantseseko presondegietan bahiturik. Gehienak binaka daude preso, nahiz eta badira guztiz isolaturik bizi diren emakumeak. Hala ere, espetxe berdinean euskal preso bat baino gehiago egoteak ez du elkarrekin egoteko aukera bermatzen; izan ere, euren artean ikus ez daitezen arbitrarioko aldatzen dituzte espetxe barruko modulo eta graduetan zehar.

Asko dira kartzelan egon arren ama izan nahi duten euskal presoak edo jada ama izanda preso hartutako emakumeak eta hortaz burdinen arteako amatasuna nolakoa den aztertzeko beta hartu beharra dago.

**erian ez dauden zauri sakonak izaten dituzte bost egunak gainditzea ez da erraza izaten, tuak izandako emakumeentzat.**

Legedi espainolak haurrek hiru urte bete artean preso duten amarekin egoteko eskubidea jasotzen du. Errealitatea ordea, oso bestelakoa da espetxeek ez baituzte ume batek behar dituen bizi baldintza gutxienekoak inolaz ere betetzen.

Hasteko, umea jaio bezain pronto dispertsioa ezagutzen du bere azalean Euskal Herrian ez baitago presondegirik amen modulurik duenik eta hortaz, ama diren emakumeek ezin dute zigorra sorterritik hurbil bete. Emakumeei bereziki zuzendutako espetxe edota moduluek ere, Brieva eta Alcalak, ez dute modulu hori ezagutzen.

Ama eta bere umea beraien bizi-girotik eta giro afektibotik urrun espetxeraturik egon beharrak indefentsioa eragiten du bai beraiengan eta baita kanpoan dauden senideentzat ere. Aita edo aitona amonak ehunka kilometro egin behar dituzte umetxoa kiristal artetik ikusi ahal izateko eta telefonoz elkar hitz egiten dutenean ezingo dira euskaraz aritu, askotan debekatuta baitute. Euskal Herritik urrun egoteak eta gainontzeko euskal presoengandik sakabanatzeak eragina izango du hizkuntzan, izan ere umeak amarekin bakarrik hitz egin dezake euskaraz.

Umeei berezitutako elikadurarik ez dago espetxe gehienetan eta amak bere jana askotan banatu behar du umeak zer irentsi izan dezan. Espetxean hezi diren umeak porlanazko patioetan ikasten dute lehen urratsak ematen baina ez dute zerekin jolastu ez baitago kulunkarik, bestelako jostailurik.

Preso dauden umeak euren amatxoekin bizi dira 2x4 metrotako gelatxoetan eta espetxe barruan zarata handia izaten da eta ateak ireki eta ixten direnean umeak izutu egiten dira. Ateak gainera, elektrikoak dira, segurtasun-dispositiborik gabekoak eta automatikoak eta hortaz itxi egiten dira tartean nor dagoen begiratu gabe.

Ez da erraza espetxean ama izatea eta nahiz eta umeak hiru urte bete arte espetxean edukitzeko eskubidea egon badagoen, emakume askok eskubide horri uko egin eta umearengandik banatzen dira.



JAKINARAZPENA-COMUNICACIÓN

| | | | | | |
|---|---|---|---|---|---|
| | 431<br>432<br>433 | | | 03 | 18/6/2008 |

JEFE DE DIVISION DE SEGURIDAD CIUDADANA
Gervasio RABIRONDO FERNANDEZ
JEFE TERRITORIAL DE LA ERTZAINTZA DE ARABA
JEFE TERRITORIAL DE LA ERTZAINTZA DE BIZKAIA
JEFE TERRITORIAL DE LA ERTZAINTZA DE GIPUZKOA
ACCIONES CONTRA LA CONSTRUCCIÓN DEL T.A.V.

En aquellos casos en que se tenga conocimiento de un hecho que, supuestamente, se ha podido producir con la intención de atacar intereses de empresas por su presunta relación con la construcción del TAV y, salvo que de las primeras investigaciones se pueda deducir lo contrario, se realizará, como mínimo, lo siguiente:

1.- ACTUACIÓN ZUTABE

En el caso de que se abriera una actuación Zutabe en la que en el formulario de datos aparezca la pregunta "¿Afecta a TAV?", se cumplimentará ésta de forma obligatoria, teniendo en cuenta además que, en aquellos supuestos en que existiera duda, se señalará en la respuesta "BAI".

2.- DILIGENCIAS

2.1.- Se abrirá referencia de atestado, independientemente de

## MARTXOAK 09

Gasteizen kalez jantzitako Ertzainek lau lagun atxilotu dituzte Salburua auzoan. Gazteak kartelak zeramatzaten, eta hasieran hormaren aurka izan dituzte, ondoren atxilo eraman dituztelarik.

## MARTXOAK 09

Ertzaintzak AHTren aurkako ekimenak terroristatzat jotzeko irizpidea eman dela publikatu da komunikabideetan. Horrela ekimen hauen inguruko txostenak espainiar Entzutegi Nazionalera bidaltzeko dio protokoloak.




## MARTXOAK 010

Frantziar poliziak lau lagun atxilotu ditu Lapurdin burutu duen operazio batean. Gauean aske utzi dituzte atxilotuak.

## MARTXOAK 011

Frantziar poliziak beste lau lagun atxilotu ditu Lapurdin burutu duen operazio berri batean. Gauean hauetako hiru libre utzi dituzte eta Mikel Onko espetxeratu egin dute.



## MARTXOAK 012

Ertzaintzak Arrasateko Portaloian zeuden euskal preso politikoen argazkiak kendu ditu espainiar Entzutegi Nazionalaren aginduz. Argazkien aurkako sorgin ehizari bide ireki zaio honela.





## MARTXOAK 013

Bilboko Deustu auzoko jaiak direla eta txosnak montatzen ari diren lagunengana hurbildu eta pankartei, txosnei eta pertsonei argazkiak atera eta hainbat lagun identifikatu dituzte.

## MARTXOAK 014

Jon Idigoras Ezker Abertzaleko kide historikoaren oroigarria errekara bota dute. Jauregibarria parkea zegoen 150 kilo pistatzen zituen.



## MARTXOAK 017

25 urte bete dira Pasaiako sarraskia burutu zenetik. Iruñeako Txantrea auzoan burutzekoa zen hitzaldia debekatu dute espainiar Entzutegi Nazionaletik eta poliziak hainbat lagun identifikatu ditu.






## MARTXOAK 018

Etxean egindako lehergailu batekin erasotu dute Tuterako herriko taberna.

## MARTXOAK 020

Frantziar poliziak bi gazte atxilotu ditu Irisarriko polizia etxean margoketak egitea egotzita. Egun osoan izan dituzte atxiloturik eta galdekatu egin dituzte.




## MARTXOAK 022

Ertzaintzak Pasaiko portu inguruak okupatu ditu airez, lurrez eta itsasoz duela 25 urte hor bertan hil zituzten euskal militanteen oroimena ekiditeko.



## MARTXOAK 022

Dani Saralegi herritarra bahitu dute zazpi orduz ustezko poliziek eta beraiekin kolabora dezan presio egin eta bere jarduera militantearen inguruan galdekatu dute.

## MARTXOAK 025

Abenduan hil zen Tito euskal preso politiko ohiaren omenez antolatua zegoen ekitaldia debekatu egin du espainiar Entzutegi Nazionalak.









## MARTXOAK 028

150 lagun bildu dira Azpeitian Pasaiako sarraskian erailak izan ziren herritarrak gogora ekarri asmoz. Ertzaintzak herritarren aurka egin zuen, bi lagun identifikatuz eta bati burua irekiz.




## MARTXOAK 030

Kondena amaitu duen egunean Xabier Etxeberria euskal preso politikoari euroagindua notifikatu diote. 28 egun zeramatzan gose greban.







## MARTXOAK 031

Espainiar poliziak zortzi gazte independentista atxilotu ditu Hernanin eta Urnietan, eta hainbat lokal eta elkarte miatu ditu. Atxilotuak inkomunikatuak, torturatuak eta espetxeratuak izango dira.

## APIRILAK 02

Espainiar poliziak bi gazte atxilotu ditu Gasteizen eta Galtzagorri taberna miatu du. Indarkeria handiz sartu dira tabernara eta dena hankaz gora eta hautsita utzi dute.



## APIRILAK 03

Espainiar Entzutegi Nazionalak Iker Rodrigo eta Amparo Lasherasi egitekoak ziren Ongi Etorriak debekatu ditu.

## APIRILAK 010

Frantziar poliziek Ekaitz Sirvent zarauztarra atxilotu dute Parisen, espainiar poliziekin batera burutu duten polizia operazioan.




## APIRILAK 015

Frantziar poliziek Itsaso Legorburu atxilotu dute Frantziar estatuko Indre departamenduan.






## APIRILAK 017

Asteburuan Foruzainek Natalia Jimenez Berrizarko bizilaguna jipoitu duela salatu dute. Gasolindegi batean gelditu eta identifikazioa gainean ez zuelako miatu eta argazkia atera behar ziotela esan zioten. Ukatu egin zen eta Foruzainek buruan eta sabelean jo zuten.



## APIRILAK 018

Jon Anza euskal iheslari politikoa desagertu egin da. Ondorengo aste eta hilabeteetan kaleratu diren informazio ezberdinek Jon Anza gerra zikinaren jomuga izan dela erakutsi dute.

## APIRILAK 018

Espainiar eta frantziar poliziek elkarlanean egindako operazio batean hiru euskal herritar atxilotu dituzte Montoriol herrian eta beste sei hego Euskal Herrian.

## APIRILAK 019

Sakabanaketa politikak 20 urte bete dituela eta protesta ugari burutu da egunotan Euskal Herrian. Etxerat elkartean ekitaldi nagusia egin du Durangon.





## APIRILAK 022

Arturo Villanueva atxilotu dute Belfasten. Egunean bertan bermepean aske utzi dute baina bere aurkako euroagindu eskaera notifikatu diote.

## APIRILAK 023

Iñaki Etxeberria euskal iheslari politikoa atxilotu dute Venezuelan.









## APIRILAK 030

18/98 auzian kalean zeuden zortzi auziperatu atxilotu eta espetxeratu egin dituzte.

## MAIATZAK 05

Patxi Lopez lehendakari izendatu dute hauteskunde ez demokratiko batzuen ondorioz indar espainiarzaleek indarrak batu ondoren.





***Fito Rodriguez***

# *J.-*

Ez du deitzen!, bota zuen garrasika Julenek.
Hitzartu genuen hartatik bi ordu luze pasa badira ere ez du seinalerik ematen... marka da, gero!
Ezin dut sinetsi. Beti izan da horren formala. Bon, egia esanda, formala baino gehiago... zurruna. Hori da bera definitzeko hitz egokiena. Kartzelan geundelarik zer-nolako grina euskara behar bezala ikasteko, adibidez. Niretzat ez zuen horrenbesteko garrantzirik, edo nik ez nion ematen behintzat... garai hartan nahiko izorratuta geunden denak Puerton eta horri irtenbidea eman nahian generaman borrokaldiak ez zuen espero genuen emaitzarik ematen. Aitzitik, gero eta isolatuagoak sentitzen ari ginen, era berean sentitzen genituen gure aldarrikapenak amiltzen... maldan behera (eta ez naiz Arestirenez gogoratzen...) baina hark, ordea, ez zuen euskara ikasteko ordu bat bera ere barkatzen eta hara!, lasaitua hartu beharrean, liburuak eta kaierrak bildu eta patiora!, Andaluzian eguraldi gozoaren bila joaten denak ez du Puertoko patioaren edo txaboloen hezetasuna ezagutzen. Hura hotz umela, reedioss...
Gero, berriz, futbolean ari ginela, ona zen gainera. Futbolarekiko harremana familiatik zetorkion, nonbait... eta, hain zen gaztea ezen sasoiaz ere erakustaldiak ematen zizkigun. Enfin... majoa baina, hainbestetan, jasanezina ere. Ez baitzen gai gauza arruntez lasai hitz egiteko! Beti atera behar zion denari bere alde politikoa eta, noski, horrek ere aspertu egiten zaitu. Inoiz edo behin politikaz mintzatzea ongi da... gu politika zela medio geunden preso, baina beti horretaz aritzea ere! Horrek edozeini atzetik ematen dio laospera!
Zergatik ez du deitzen, ordea?
Bera ez da horrelakoa.
Ezin dut ulertu.



# O.-

Taberna hau beti gustatu zaio... baina, honezkero, berandu da eta ez da ageri, kezkatu zen Olatz.

*"Primus"* izena bitxia da. Senideen artean zaharrenak abian jarriko luke, agian. Zuberotar hauek horren bereziak ohi dira hizketarako... askotan ez ditudala ulertu ere egiten. Oso giro jatorra dute hemen. Sarrikotagainera etortzeak merezi du. Jendea ez dator Lakarritik bakarrik, Aranetik, Alozetik eta Atarratzetik ere badatoz.Toki lasaia eta atsegina baita.

Baina hau, berriz, ez da etorri. Eta berandu da.

Ez dut uste elizaren atzean begira geratu denik. Aurrekoan erakutsi nion eta aski denbora pasatu genuen hor hilobietako esteletan azaltzen diren zeinuak ulertu nahian... izan ere, honelako parajeetan arabierazko hilobiak aurkitzea ere! Arabieraz bakarrik ez, bi alfabetoetan izkiriaturik alajaina!

Baxenafarroan egon badaude hebraieraz idatzitako hilobiak, Bidaxunen edota Bastidan, esaterako, haiek ere zaloak izaten dira, elebitan daude, baina, Agramontarren Printzerrian ezin gutxiagorik!. Gaur haien gaztelua birrinduta egon arren haien garratzi historikoa ezin uka, Mazarin, Richelieu eta enparauak hantxe ibiliak dira... Nafarroako erresuma zen... baina Lakarrin!

Edozein modutara, alferrik ari naiz denbora-pasan denboraz pasa egin baita...

Bera etorri gabe,

Eta abisatzeke...

Ez da normala...

# N.-

Nagore urduri zegoen. Errobi ondoan geratu ziren, Garazin, berak ibaia gustukua zuelako, ez bertan harrapatzen diren amuarrainek bereziki Pirinioetatik datozen uren marmar lasaia aditzeko. Gainera, Zuberora joan behar zuela esan zuenez, bidean ongi zetorkion baina... ez du seinalerik eman, ordea. Errobi lasaigarri honen ondoan ez nago ni batere lasai, arranopola!

Citadelleko karrikan geratuta geunden ez da inoiz berant etortzen.

Egia da azken garaiotan pisu asko irabazia zuela... hain zen liraina duela gutxi arte. Zeukan adina ez zuen ematen, askoz gazteagoa zirudien, baina eri zegoenez eta eritasunaren aurkako botikek ez dakit onik egiten zioten, itxuraz behintzat, ondorioak oso nabariak ziren.

Gotorlekura joateko bidean, 32. zenbakian dagoen kartzela zaharra erakutsi nionean bere kartzeladiez oroitu zen. Hain baikorra izanik, hainbeste urte giltzapean pasatu ondoren, ez zuen bereziki oroitzapen txarrik gordetzen. Hantxe eginiko adiskideenak bakarrik zituen, Julenena kasu, edota bisitetan ezagututako lagunenak, Nagore bezala...

Hemen dagoen apezpikuen kartzela hau, aldiz, ez dut uste inoiz ere apezentzat izan denik, toki guztietan bezala herri xumea izan da hemen gordea. Harrigarria da, horrelako beste giltzape batimenduen antzera nonbait, zenbat idazki dauden horma haietan. Jonek, ezagutu dituen kartzela guztietan mezu idatziak ikusi dituela dio. Kriptaturik,

askotan. Akronimoak eta horrelakoak. Berak jakingo du, izan ere bizitzaren erdia pasatu baitu kartzelan. Ea orain zorte imini bat duen eta, gaixo bada ere, lasai bizitzerik badaukan... horregatik gustatuko zaio Errobiren xuxurla... lasaia baita...
Baina ni ez nago lasai.

# A.-

Anderea kexu.
Gizon betaurrekodun hura ez zen azaltzen eta lurrina prest zegoen.
*"Parfums et Senteurs du Pays Basque"* dendaria gazte euskaldun harekin mintzatu zelarik oso atsegina iruditu zitzaion, baldar xamarra beharbada. Ez zuen ematen ondo ikusten zuenik baina sudurra behintzat bazekien erabiltzen, berehala ohartu zen zer- nolako lurrina nahi zuen. Nagore izeneko neska batentzat omen zen eta presa zuen. Gaur etorriko zela esan zidan baina ez da agertu.
Ez nion dirurik eskatu nahiz eta enkarguentzako hori izaten den ohikoena baina zintzoa zirudien... eta euskalduna, hitzekoa alegia. Baina egun osoan zehar ez da enkarguaren bila inor agertu, eta bera ere ez, jakina. Hala da dendarion patua, bezeroren bat begiko hartu arren berriro inoiz ez agertzea gerta daiteke... eta, oraingo honetan, hala gertatu dela ematen du... kezkatzekoa da, halere.

# N.-

Nahikarik ikusi zuen trena hartzen.
Berak Nahikari ez. Gero eta gutxiago ikusten omen du.
Oloroera edo Okzitania aldera zihoala esan zion gerturatu zenean.
Ez, ezer berezirik ez. Garazira eta Bastidara joan nahi zuela, Zuberora, agian, eta gero jarraitu bide horretatik, beste kezkarik gabe, lasai... lasaitasuna behar zuela zioen.
Orain, berriz, Nahikari omen da bera ikusi zuenetako azkena... edo azkenetariko bat.
Bat baino gehiago zer gertatu ote zaion ari da galdezka.
Lagunek ez dute haren berririk.
Non da?

**Gotorlekura joateko bidean, 32. zenbakian dagoen kartze**
**baikorra izanik, hainbeste urte giltzapean pasatu ondo**
**eginiko adiskideenak bakarrik zituen, Julenena kasu**

# Z.-

Zigorra eta latza. Hala izan da bere bizitza.
Eta heriotza?
Eri zegoen.
Herioak harrapatu al du?
Nola?
Zergatik?
Nortzuk?
Zertarako?

# A.-

Albiste?, Abaila?, Abailtzea?, Abaroan?, Abenikoa?, Abentura?, Aberasbide?, Aberekeria?, Aberkide?, Abertzale?, Abespelua?, Abiatu?, Abisua?, Absolbitu?, Absurdua?, Aburua?, Adabakia?, Adabegia?, Adar jotze?,Adarkada?, Addar?, Adelua?, Adia?, Adibidea?, Adiera?, Adierazlea?, Adiezina?, Adikuntza?, Adina?, Adio?, Adiskidea?, Aditua?, Aditzailea? Adiurrea?, Adorea?, Ados?, Adrenalina?, Adurra?, Agergarria?, Agerria?, Agian? Agindua?, Aginpidea? Agintaritza?,

**la zaharra erakutsi nionean bere kartzeladiez oroitu zen. Hain oren, ez zuen bereziki oroitzapen txarrik gordetzen. Hantxe ., edota bisitetan ezagututako lagunenak, Nagore bezala...**

Agiraka?, Agiria? Agonia?, Agortua?, Agur,? Ahaidea?, Ahakarra?, Ahala?, Ahalbidea?, Ahalkea?, Ahalmena?, Ahapeka?, Aharra?, Aharrausia?, Ahazmena?, Ahitzea?, Ahoberokeria?, Aholkua?, Ahozabalik?, Ahulezia?, Ahuspez?, Aiduru?, Aienea?, Ahierra?, Aiko-maiko?, Aingeruki?, Aintza?, Ainubea?, Aiotsa?, Aipagarria?, Airatzea?, Aitarenka?, Aitormena?, Aitzindaria? Aitzin-gibel?, Aizkorakada?, Akabatzea?, Akelarrea?, Akiakula?, Akidura?, Akordartzea?, Akuilua?, Akuria?, Akusatzailea?, Alafede?, Alaraua?, Alba?, Aldaezina?, Aldakuntza?, Aldarea?, Aldarria?, Aldartea?, Aldatzea?, Alde egina?, Aldendua?, Alderdikeria?, Aldigaiztoa?, Albredes?, Alegia?,Alezta?,Aliantza?,Altxatzailea?,Alukeria?,Amaiezina?...






## MAIATZAK 06

Presoen argazkiak erakusten dituzten sei etxetara sartu da goizean Ertzaintza Donostian eta hauek kentzeko agindua eman die bizilagunei. Espainiar Entzutegi Nazionalaren aginduz aritu dira.

## MAIATZAK 012

Guardia Zibilak Ibon Meñika torturatu zuela salatu izanagatik Julen Larrinaga eta Aiert Larrarteren aurkako epaiketa hasi da Bilboko epaitegian. Meñikak berretsi egin du torturatu egin zutela.






## MAIATZAK 013

Durangaldeko bi gaztek azken urte eta erdian kalez jantzitako polizia ugari atzetik dituztela salatu dute. Kalean zein autoz etengabe jarraituak direla salatu dute.

## MAIATZAK 015

Espainiar Entzutegi Nazionalak Bilbon hurrengo egunean Aner Gomez preso ohiari egin asmo zioten Ongi Etorria debakatu du.




## MAIATZAK 019

Ertzaintzak Lander Fernandez bahitu eta beraiekin kolaboratu dezan mehatxu egin dio. Ondorengo egunetan berriz ere jazarria izango da preso ohi santutxuarra.

## MAIATZAK 021

Ertzaintzak eta Udaltzaingoak zazpi lagun atxilotu ditu Euskal Herriko gehiengo sindikalak deitu duen Greba Orokorraren egunean. Goizean goizetik langileak kalera atera dira eta polizia ezberdinen jazarpena etengabea izan da.











## MAIATZAK 022

Iruñeako udaltzainek Burlatako gazte bat atxilotu dute bezperan izandako greba egunean gertaturiko liskarretan parte hartzea egotzita. 24 orduz atxiloturik izan dute gaztea.

## MAIATZAK 025

Frantziar poliziak Iker Esparza gaztea atxilotu du Parisen.



## MAIATZAK 026

Arbizuko Udalak Guardia Zibilaren aldetik herritarrek jasaten duten presioa eta mehatxuak salatu ditu.




## MAIATZAK 030

Erroman espainiar errepresioaren aurka protesta egin duten hamairu gazte independentista eta hauek babestera joan diren sei gazte italiar atxilotu ditu bertako poliziak.

## MAIATZAK 030

Miarritzen UMPk mitina zuen lekuan elkarretaratze jendetsua burutu dute Jon Anzaren desagerpena salatzeko. Polizial gas negar eragileekin jo du manifestarien aurka baina protesta Alliot Marie barne ministroarenganaino iritsi da.



## MAIATZAK 030

Espainiar poliziak herritar bat atxilotu, jo eta mehatxatu duela salatu dute. Gauez burua makurtuta eta begiak itxita eduki dute, behin eta berriz kolpatuz. Poliziarekin kolaboratu dezan presio egin diote.







## MAIATZAK 031

Ibilaldiaren egun handian txosnagunean zeuden herritarren aurka jo du Ertzaintzak presoen argazkiak eta pankartak kentzera etorri denean. Gutxienez 20 lagun zaurituak izan dira.

## EKAINAK 02

Ertzaintzak bi gazte atxilotu eta hauen etxebizitzak miatu ditu Gasteizen kale erasoetan parte hartzea egotzita.

## EKAINAK 04

Espainiar militarrak Iratiko basoan ibili dira egunotan froga militarrak egiten.





## EKAINAK 05

Igor Portu, Mattin Sarasola eta euskal preso politiko guztiei *Maite zaituztegu!* esateagatik urtebeteko espetxe zigorra eta zazpi urteko inhabilitazioa ezarri dio espainiar Entzutegi Nazionalak Marian Beitialarrangoitiari.



## EKAINAK 05

Ertzaintza Galdakao, Usansolo eta Ugaoko herriko tabernetan ibili da euskal preso politikoen argazkiak kentzen. Langileak identifikatu eta mehatxatu dituzte.





## EKAINAK 08

Kepa Arizmendi Elizondoko euskal iheslari politikoa hil da Baionan garun isuri bat izan ondoren. Bere herrian eta Lapurdin omendua izango da egunotan.






## EKAINAK 09

Frantziar poliziak Ugaitz Arin, Ioritz Aranbarri eta Iban Aldana gazteak atxilotu ditu Lapurdin kale erasoetan parte hartzea egotzita. Gauean aske utzi dituzte.

## EKAINAK 09

Ertzaintzak Villabonako plazan zeuden euskal preso politikoen argazkiak kendu ditu.




## EKAINAK 013

Milaka lagun kalera atera dira Donostian Jon Anzaren desagerketa salatuz. Gerra zikinaren aurkako mezuak izan dira manifestazio amaieran.

## EKAINAK 013

Hiru preso politiko eta hiru euskal herritar atxilotu ditu Guardia Zibilak Grande Marlaska epailearen aginduz. Bi presoren ihesaldia prestatzea egotzi diete seiei.

## EKAINAK 014

Kalez jantzitako espainiar poliziek Lander Fernandez preso ohi santutxuarra atxilotu zuten Madrilgo Barajas aeroportuan. Berarekin zetozen bi lagunak Madriletik Euskal Herrirako bide osoan jazarriak izan ziren. Lander espetxeratu egingo dute hurrengo egunean.







## EKAINAK 016

Bautista Barandalla eritasun larria duen euskal preso politikoari espetxealdi arindua ezarri diote. Harrera beroa egin diote Etxarriko herritarrek.

# Errepresioaren HAMAIKA AURPEGIAK

Floren Aoiz

2009an talde faxisten indarkeria agertu da berriz Euskal Herrian. Erasoak, mehatxuak, pintaketak... mota ezberdinetako gertaerak ezagutu ditugu, batez ere Nafarroan, baita hainbat atxiloketa eman ere, nahiz eta nabarmena izan den akusatuek ez dutela estatuek erabiltzen duten *"terroristendako tratu berezia"* jaso.
Batzuek, gainera, atxiloketa hauek goraipatu nahi izan dituzte espainiar polizien profesionaltasuna nabarmentzeko, jendeari sinestarazteko espainiar estatua ez dagoela eraso horien gibelean, kontra baizik.
Hau bertsio ofiziala izanik, errealitatea oso bestelakoa da. Sarritan erabili dituzte mozorro faxistak estatuen lan zikinak izkutatzeko. Eta askotan sinestarazi nahi izan digute gogotik jarduten dutela faxista horien kontra, haiek indarkeria guzien aurka jotzen dutelako.
Bestela pentsatzea baherrezkoa da, saltzen dizkiguten gezurrak aztertu eta atzean dagoena argitaratu behar dugu. Ezin baita onartu espainiar estatuak bere burua garbitu nahi izatea "faxista" batzuk atxilotu dituelako.

**Faxistak, ultraeskuindarrak, ultranazionalista espainiarrak?**

Gure gatazka egoeran hitz batzuk lehiaren lehen mailan kokatzen dira. Pentsamendu bakarrak erdia aldarrikatzen du muturkerien aurrean, mutur horiek (eskuin-ezker) parekatuz. Gurera etorriz, ETAren indarkeria ultraezkertiarren aintzinean, faxisten indarkeria ultraeskuindarra. Edo, bestela, euskal ultranazionalistak, espainiar ultranazionalisten kontra. Betire, muturrak elkar joka eta estatua legearen agindua ezarriz. Hau da zabaltzen duten bertsioa.
Bi muturren bertsio horrek erdian kokatu nahi ditu batzuk, idatzi bezala. Estatua absolbitzen du, gehiegikeriatik at jotzen duelako eta jarrera extremista fanatikoetatik urrun kokatzen duelako. Bestalde, gaur egungo espainiar estatuak faxismoarekin izan dituen eta dituen loturak estali nahi ditu, batzuek



estatuari egindako faboreak ahantziarazi nahian.

Gauzak horrela, beharrezkoa da bertsio horiek errefusatzea, gatazkaren natura desitxuratzeko eta jendartea aldatu nahi duten subjektuen kriminalizazioa bilatzen duelako. Denok dakigu zer izan zen faxismoa, zer ekarri zuten Hitler eta Musolinniren erregimenek. Horregatik oroitzapen kolektiboan errotu diren irudiak erabiltzen dituzte ezkerreko mugimenduak zikintzeko, faxistekin alderatuz.

Faxistak ez dira ezkertiar iraultzaileekin parekatu behar, berriz, kapitalismoa eta inperialismoaren beste defendatzaileekin baizik. Faxismoa kapitalismoak jendarte aldaketa lortzeko grinari oztopo gisa erabili zuen ideologia baita. Kapitalismoa bera faxista bilakatu baitzen amets sozialistari aurre egiteko. Eta faxista bilakatu ez ziren beste kapitalista-inperialista batzuek Alemania eta Italiako faxistei bide askea utzi zieten haien interesen arerio bilakatu ziren arte.

Neoliberalistek saldu nahi diguten gezurra agerian utzi behar da. Kapitalismoa da faxismoarekin loturak izan dituena eta gaur egun ere gordetzen dituena. Inperialismoaren tresna izan da faxismoa, eta bigarren munduko gerla bukatu ondotik ere, Inperioak faxismoa erabili du, diktadurak bultzatu ditu, eskuinmuturra baliatu du, mundu justuago baten aldeko borrokalariei aure egiteko.

Inperioak etengabean oroitarazten digu nazien kontra egin zuela gerla, demokrazia defendatu zutela faxismoaren aurrean. Estatu Batuek mundua salbatu zuten, nonbait. Beste batzuk izan ziren, berriz, naziak garaitzeko sakrifizio handienak egin zituztenak, hasieratik faxisten kontra oldartu zirenak, kapitalismoak naziekin zituen loturak salatu zituztenak.

Munduan zehar hamaika diktadura bultzatu ditu Inperioak bigarren munduko gerla bukatu ondotik. Besteak beste Francorena. Alemania eta Italia aipatu ditut, baina Espainia ere aintzat hartu behar da.

1936ko estatu kolpe faxistak arrakasta izan zuen beste faxisten laguntza zuzena izan zuelako. Ados, hau egia da, baina ez egi osoa. Kolpeak 40 urteetako diktadura ekarri zuen estatu kapitalistek ahalbideratu zutelako, errepublikari behar zituen defentsarako euskarriak ukatuz. Inperalista zaharrek (Britaina Handiak) eta berriek (Estatu Batuek) ireki zioten bidea Francori, eta munduko gerla bukatu zenean, berriz ere babestu egin zuten, diktadura salbatuz.

Gehiago ere egin zuen Inperioak: trantsizioa planifikatu eta zuzendu zuen, Franco hil ondotik dena lotuta eta ongi lotuta geldi zedin. Haiei esker desmobilizatu ziren makiak, haiengatik baztertu zen errepublikar legalitatea berreskuratzeko aukera. Horiek izan ziren frankista guzien inpunitatea bermatu zutenak. Halaber, haiek izan ziren estatua sakonki aldatzeko aukera galarazi zutenak.

Faxismoaz hitz eginez gero, benetako faxismoa aipatu behar behar da, espainiar estatuaren jarduera markatu duena, gaur egungo *"demokrazia"*ren mamian gorderik dagoena, gaur egungo egoera inspiratzen duena. Kontua ez da gaur egungo espainiar estatua faxistatzat hartzea, nabarmena baita bere burua egokitu duela munduaren aurrean bestela agertzeko. Gaur egungo espainiar estatua ez da Francoren garaikoa, jakina, baina Francoren dikaturarekiko lotura estuak ditu, moztu nahi ez dituen loturak, hots.

Batzuk *"faxista"* deituz bere burua garbitu nahi du Francok aukeratu zuen gizona estatuburu duen Espainiak. Diktaduratik gelditzen den bakarra horiek balira bezala.

Finean, faxista batzuk, gerla galdu zutenak, Alemania eta

Italiakoak, adibidez, estigmatizatuta gelditu ziren, baina beste batzuk, berriz, salbatu ziren. Espainiar estatuan, adibidez, alderdi faxistak legalak dira, 1936ko kolpearen ondotik ezarritako diktaduraren alderdi bakarraren zilegitasuna aldarrikatzen duten alderdiak guziz legalak dira. Haiendako ez dago Alderdien Legerik!

Espainiar estatuak ez du inoiz espainiar nazionalismo faxistarekiko lotura hautsi. Beren burua faxistatzat jotzen dutenek PSOE, UPN eta PPren jarrera bera dute Euskal Herriaren aurrean: nazio bakarra Espainia da. Denak espainiar nazionalistak dira, ñabardurak ñabardura Francoren eredua, espainiar inperioaren eredua bereganatu dutenak. Batzuek egokitu nahi izan dute *"konstituzionalista"* gisa agertuz, besteek aspaldiko hizkera eta ikur zaharkituak erabiltzen segitzen dutelarik, baina denak esparru berean kokatzen dira.

Horregatik oso erabilgarriak izan dira beti *"faxistak"*. Oso emankorrak estatuaren hainbat lan zikin egiteko.

**Espainiar estatuak ez du inoiz espainiar nazionalismo**
**dutenek PSOE, UPN eta PPren jarrera bera dute Euskal H**
**nazionalistak dira, ñabardurak ñabardura Francoren e**

### Ultraeskuindarrak, estatuaren azpikontrata?

Testuinguru honetan kokatu behar ditugu, ene ustetan, 2009an gertatutakoa. Aurretik ere estatuaren estrategia mozorro ezberdinekin gauzatu da. GAL taldea, Batallón Vasco Español, AAA, Guerrilleros de Cristo Rey, zerrenda luzea da. Francoren azken garaietan bezala, Franco hil ondotik ere faxismoa (ultraeskuina orohar) erabili dute hainbat joera errepresiboei beste mozorroa eskaintzeko.

1981ko autokolpe bera, autonomien eredua mugatzeko eta Suárez agertokitik usatuz PSOE Monkloara eramateko erabili zutena, ultraeskuindarren operazio gisa aurkeztu zuten, gezurra izanik ere.

Faxismoa eta ultraeskuina aitzakia ederrak izan dira *"demokrazia"*ren jarduera batzuk izkutatzeko. Honetarako, deskontrolaren fikzioa sortu zuten. *"Incontrolados"* esaten zitzaien garai batean lan zikin horiek gauzatzen zituztenei. Herriak ederki ulertu zuen jokua, mobilizazioetan erabiltzen zen leloak adierazten zuenez: *"de día uniformados, de noche incontrolados"*. Ultraeskuina bilakatu zen, beraz, errepresioaren mozorroa, estatuaren jardueraren beste aurpegi bat, aurpegi izkutua.

Espainiar segurtasun zerbitzuen ibilbidea aztertu duen orok ongi daki beti kontrolatu dutela eskuinmuturra. Informazio taldeek infiltratu dituzte, erabili dituzte, nahi dutena egin dute haiekin, txontxongilo gisa maneiatuz. Ikasi dute, bestalde, errentagarria zela operazioa, estatuari merkeago ateratzen zitzaiola gauza batzuk horrela egitea bestela baino. Gaur egun, berriz, GALen eskandalua lehertu ondotik, poliziak harri azpian ere agertzan direlarik, gero eta zailagoa da deskontrolaren fikzioa mantentzea. Beste bide batzuk lehene-

tsi dituzte, batzuek GAL juridikoa bataiatu dutena, adibidez.
Aurtengo areagotze errepresiboaren barnean agertu dira eraso faxista berri hauek, polizi ezberdinei leporatutako operazio batzuk (bahiketak, mehatxuak, eroste saioak) jazo diren une berean. Egindako atxiloketen ondotik itxitzat eman nahi izan duten afera, baina nabarmena da auzi larri baten aintzinean gaudela.
Finean, Falange y Tradición izena erabiltzen zuten horien atxiloketa garbiketa saioa izan da, orain arte aipatu dudan guzia kolokan jartzen ez duena. Izan ere, ideologijoki eta politikoki joera faxistak bultzatzen ditu estatuak. Eraso horietarako giroa sortu eta elikatu dute. Nire ustetan, dena tu kolpean inplikatuta egon elkarren arerio izan ziren falangismoa eta karlismoa uztartu nahian. *"Fascismo a la navarra"*, nolabait esateko, legaltasunean eta arazorik gabe diharduten talde, komunikabide eta pertsona batzuen mezuen bide beretik.
Nafarroaren inguruan inboluzio kezkagarria gertatzen ari da espainiar nazionalismoaren esparruan. Batzuek 1936ko mezuak berreskuratu nahi izan dituzte euskaltzaleen kontra, gaur egungo Navarra foral eta espainola babesteko. Baina benetako erronka UPN eta PSOEren elkarbidean dago, faxismoa bertara iritsi zen garaietan gorpuztutako ideologian, navarrismoan. Itxura faxistarik gabeko erro

**faxistarekiko lotura hautsi. Beren burua faxistatzat jotzen lerriaren aurrean: nazio bakarra Espainia da. Denak espainiar eredua, espainiar inperioaren eredua bereganatu dutenak.**

uztartzen da estrategia berean. Nabarmena da estatuak ez duela erantzun gogor bat izan, eta hau ere mezu bat da.

**Non eta Nafarroan!**

Gero eta guttiago sinesten dut kasualitateetan. Horregatik, aipatzekoa da eraso gehienak Nafarroan gertatu izana. Nafarroa gatazkaren agertoki berezia da, lehiagune nagusietarik bat. Nafarroa estatu afera da espainiar nazionalistendako, faxista itxura hartzen dutenendako eta bestelako mozorroa erabiltzen dutenendako.
Esanguratsua da Falange y Tradición taldearekin egin nahi izan duten pirueta ideolojikoa, nahiz eta 1936ko esta- faxistak dituen ideologian, hots.
Ez diet eraso faxista horiei garrantzirik kendu nahi, jakina, baina uste dut gibelean dagoen estrategiari erreparatu behar zaiola batez ere. Batzuen *"gehiegikeriak"* aipatuz beste batzuenak izkutatu nahi dituzte. Eraso ilegalak persegitzen dituztela irudikatuz eraso legalak noraino iristen diren izkutatu nahi dute.
Finean, batzuk faxistak badira, besteak ez dira demokratak, nahiz eta demokrazia erabili haiekin ados ez gauden oro kriminalizatzeko eta jendarteari erabaki askean hartzeko eskubidea ukatzeko.





## EKAINAK 017

Ertzaintza Uribarriko herrikoan sartu da eta euskal preso politikoen argazkiak eraman ditu bertatik.

## EKAINAK 020

Euskal Herrian inoiz egin den auzolanik handienetakoa burutu da egunotan Lakuntzan euskal preso politikoekiko elkartasunez. Milaka lagunek parte hartu dute Hatortxu 10 jaialdi handian.




## EKAINAK 023

Hiru euskal herritar atxilotu ditu espainiar poliziak Usurbilen eta Astigarragan ETAkoak izatea egotzita. Inkomunikatuak, torturatuak, espetxeratuak eta sakabanatuak izango dira.




## EKAINAK 025

Jose Antonio Otxoantesana iheslaria hil da Mexikon 57 urte zituela. 28 urte eman ditu ihesean. Mexikon eta Ondarrun omenduko dute ondorengo egunotan.

## EKAINAK 026

Xabier Arruabarrena eta Oihana Garmendia atxilotu dituzte Paris inguruan, espainiar eta frantziar polizien kolaborazioarekin.




## EKAINAK 026

Ertzaintzak gazte bat atxilotu du gauez Mungian PNVren eta PSOEren aurkako margoketak egitea egotzita.

## EKAINAK 028

Frantziar poliziak hamar lagun atxilotu ditu Lapurdi eta Nafarroa Behean egindako polizia operazio zabal batean. Egun berean Jon Goio euskal iheslari politikoa ere atxilotu du.

Frantziako poliziak Xan Beyrie atxilotu du Kanbon eta bere gurasoen etxea miatu dute.

## EKAINAK 029

Bilboko Errekalde auzoko jaietan Ertzaintzak bost lagun identifikatu eta presoen argazkiak eraman ditu. Lau eguneko jaiak ospatzen dituzte auzo honetan, eta Ertzaintza hiru aldiz agertu da bertara.

## EKAINAK 030

Europako giza eskubideen Auzitegiak espainiar estatuaren legez kanporatze estrategia babestu du Herri Batasunaren, Batasunaren, AUBren, HZren eta 218 herri plataformen legez kanporatzea berretsiz.













**EKAINAK 030**

Frantziar poliziak Oihana Mardaras eta Ibai Mateo atxilotu ditu Frantziaren iparraldean.

**UZTAILAK 02**

Bilboko txupineraren izena baztertu du udalak bere neba espetxean duelako.

**UZTAILAK 03**

Lander Fernandez libre gelditu da 4.000 euroko bermea ordainduta. Ertzaintzak Landerren harrerara hurbildutako herritarren aurka jo du.

**UZTAILAK 04**

Frantziar Poliziak Asier Borrero, Itziar Plaza eta Iurgi Garitaonaindia atxilotu ditu Pau inguruan. Egun batzuetara espetxeratu egin dituzte hiru euskal herritarrak.

**UZTAILAK 09**

Iruñeako udaltzainek Martxel Toledo ESAITeko kidea atxilotu dute San Fermin jaietan kamisetak saltzen ari zela.

**UZTAILAK 010**

Santutxun gazte bat atxilotu du Ertzaintzak kalean Ezker Abertzaleko kartelak jartzen ari zela.

**UZTAILAK 010**

Espainiar militar batek Iruñeako Muthiko Alaiak Peñaren lehendakaria erasotu du.






**UZTAILAK 012**

Ertzaintza Barakaldoko txosnetara sartu da eta bertatik euskal preso politikoen argazkiak eraman eta hiru herritar identifikatu ditu.

**UZTAILAK 015**

Ertzaintzak 20 urteko gazte bat atxilotu du Gasteizen Radio Vitoria eraikinari pintura jaurtitzea egotzita.

**UZTAILAK 015**

Zigor Goikoetxea libre atera da 6.000 euroko bermea ordainduta. Marisa Arrue PPko zinegotziarengandik 300 metrotara bizitzea debekatu diote.





## UZTAILAK 017

Alain Berastegi Arbizuko preso ohia bahitu, torturatu eta galdekatu dute ustezko poliziek Irunberri inguruan. Beraiekin kolabora zezan eskatu diote.




## UZTAILAK 017

Arrigorriagan Guardia Zibilaren lau patrol txosnagunera sartu dira eta 20 lagun identifikatu dituzte, hauetako asko mehatxatu egin dituztelarik.

## UZTAILAK 017

Espetxetik atera berria den Zigor Goikoetxearen gurasoen etxean margoketak egin dituzte eta etxeko sarrerari su eman diote.




## UZTAILAK 019

Goizaldean gazte bat atxilotu eta jipoitu du Ertzaintzak Villabonan. Garagardo azokatik hurbil zegoen pankarta bati argazkiak ateratzen ari zirela gazte talde bat *Non da Jon?* ohiukatzen hasi da eta hauetako baten aurka oldartu eta gogor jipoitu dute, ondoren atxilotua eramanez.







## UZTAILAK 019

Algortako bi neska atxilotu ditu Ertzaintzak Santutxun presoen aldeko pegatinak zeramatzatelako. Kentzeari uko egin ondoren Ertzainek atxilo eraman dute.

## UZTAILAK 023

Xan Beyrie kanboar gaztea epailearen aurrean izan da deklaratzen eta espetxean sartu dute.







## UZTAILAK 023

Frantziar poliziak Ekai Alkorta 38 urteko Zumarragako iheslaria atxilotu du lanera bidean. Espetxeratu egin dute.

## UZTAILAK 027

Soraluzeko herriko plazan euskal preso politikoen eskubideen aldeko mezua zuen murala ezabatu eta inguruko kartela kentzen aritu da Ertzaintza. Inguruan zeuden hiru gazte identifikatu eta hauetako bat jipoitu egin dute.




## UZTAILAK 027

Iruñeako Armonia Txantreana eta San Fermin peñetako ordezkariak auzitara eramango dituela jakinarazi du bertako udaltzaingoak beraien pankartetan presoen aldeko mezua eramatea egotzita.




## UZTAILAK 029

Guardia Zibilak Iker Acero, Alberto Martinez eta Arkaitz Artola atxilotu ditu Gaztesarea weguneare bidez ETAri laguntza ematea egotzita. Gaztesareako egoitza miatu dute zortzi orduz. Gazteak baldintzapean aske utzi dituzte bi egunera.

## UZTAILAK 030

Villabonan herriko jaien testuinguruan euskal preso politikoen eskubideen alde antolaturiko ekimenak debekatu ditu espainiar Entzutegi Nazionalak.



## UZTAILAK 031

Donostian Jon Anzaren desagerpena salatu dute ekimen ikusgarri baten bidez. Ertzaintzak hamar lagun atxilotu ditu.



## UZTAILAK 031

Ertzaintzak Villabonako herria okupatu du sekulako presio egoera ezarriz. Remi Ayestaran herriko alkateordea Ertzaintzarekin izandako eztabaida baten ondoren hil da, hauek mehatxatu eta iraindu ondoren ondoezak jota.

# NEURRIRA egindako JANTZI ESTUEGIAK

*Mikel Albisu Iriarte "Antza"*

Zapata estuegiak. Gutxi maite gaituen norbaitek jostunarenean guretzat beren beregi enkargatutako jantzi txikiegi bat. Alde guztietatik estura sentiarazten digun bigarren azala, gau eta egun gainetik kendu ezin duguna. Espetxea.

Garai batean, presoei espetxeratu ahala kaleko jantziak kendu eta preso-jantzi berezia ematen zieten. Komikietan oraindik ere erabiltzen den marradun pijama horren antzekoa edo ehun latzez eta jostura baldarrez egindako uniformea. Atorra eta galtza nasaiak, zabalegiak eta motxegiak, barregarriak, besteren bizkar barre egitea maite duten jende tristeek diseinatutakoak.

Espetxe arautegien asmatzaileek, presoa modu horretan nabarmenduz, umiliatzea ez ezik, bere menperatu kondizioa une oro oroitaraztea izango zuten helburu. Horrela,legez kanpo kokatutako pertsona guztiak (lapurrak, hiltzaileak, indarrean dauden arauen haustaileak edota justizia-administrazioaren hatzaparretan eroriz geroztik de factozko errudun bihurtzen direnak) beren buruaz arduratzeko ahalmenaz gabetu eta giza mailatik behera ezartzen zituzten.

Hain zuzen ere, gatibuak bizitzako beste arlo guztietan jasaten zuen erabateko menpekotasunaren adierazgarri onena nahitaez eraman beharreko jantzi hori zen. Agintedunek erabakitzen baitzuten zer jango eta edango zuen; noiz jaiki eta lokartuko zen; noiz eta zenbat denboraz egurastuko eta noiz eta zenbatetan garbituko zen; zer irakurriko zuen eta, batez ere, zer ez; nori eta zein maiztasunez idatziko zion (nolako maitasunez ere, zentsuraren kariaz); nor eta zein baldintzetan ikusiko zuen eta nor ez.

Haur gaiztoak maite ez duen panpina gaixoa jantzirik itsusienekin jantzi bezala janzten zituzten espetxe-arduradunek beren mendera eroritako zigortuak. Ondoren, haur gaiztoak maite ez duen panpinari besoak, hankak eta burua erauzten dizkion bezala, espetxe-arduradunek presoari bortxa-lanetan birrintzen zizkioten besoak, hankak kateekin elbarritzen eta




burua zigor ziegetako egonaldi luzetan ezintzen edo, besterik gabe, gillotinarekin ebakitzen zioten.

Hain aspaldiko kontuak ez diren arren (hiru hamarkada besterik ez dira Fresneseko gillotina hautsa biltzen ari dela) Mendebalde Zibilizatuko République handi honetan ez da jada inor laburtzen. Grandeur-aren ohoragarri, beste modu eraginkorrago eta garbiagoak aurkitu dituzte jendaila deuseztatzeko. 2009an ehundik gora presok egin du bere buruaz beste Frantziako kartzelatan. Aurtengo lehen hamabostaldian dozena inguruk buru-justiziatu du jadanik bere burua. Lehen bezala, oraindik ere, Kartzela-Administrazioaren hatzaparretan erortzen dena ez da jadanik herritarra edo biztanlea, eskubiderik gabeko izakia baizik. Espetxe bakoitzeko arautegi arbitrario eta absurdoaren menpe edo zaindari sadikoen apeta eta frustrazioen jomuga.
Edonola ere, Frantziako kartzeletan orain ez gaituzte uniformea edo jantzi barregarririk eramatera behartzen. Senide eta lagunek erosten edo egiten dizkiguten arropak daramatzagu soinean. Gainera, askatasunaren usaina dakarten arropa horiek gure nortasuna ere nabarmentzen dute. Jantzi batzuk, kartzelako masa anonimoan, gure jatorriaren ikur bihurtzeraino. Mundu gris honetan tankera bereziko izerditakoa, adabakidun galtzak edota kolore biziak daramatzan norbait ikusiz gero, ez da zalantza askorik egin behar:

*Aupa! Euskalduna?*
*Bai!*
*Mikel nauk!*
*Ni Xabier!*

Nolako poza! Nolako besarkada estua, ordura arte izen-abizenez baino elkar ezagutzen ez genuen burkideen artean!

Hala ere, gaur egungo espetxe politikak hain antzinakoa ez den araudi haren oihartzuna ekartzen digu. Eta askotan, birgizarteratzearen lurrin progrearen azpian lehengoari inbidiarik ez dion krudeltasun fin eta gupidagabea ezkutatzen du.

Adibidez, lehengo garai haien oroigarri gisa-edo, indarrean diraute jantziei dagozkien arau batzuk: kartzelako lantegira joaten direnei jantzarazten dieten uniforme lotsarazlea; aterkirik gabeko mundu honetan, euritako eta izerditako txanodunen debekua; presozainen uniformearen antzekoegia den den kolore urdineko arropen debekua; mahuka gabeko kamisetarekin edota galtza motxetan ziegatik ateratzeko debekua.

Horren oinarrituz, ikustaldi osteko miaketan biluzarazi gaituen presozainak errieta egingo digu galtza piratekin dutxara abiatuz gero, gure gorputz osoaren biluztasunak ez bezala hankasagarrenak kitzikapen erotiko aitorrezinak eragingo bailizkion.

Alabaina, gureek sartzen dizkiguten arropa erosoekin janzten garen arren, ez da desagertzen espetxeko lehen egunean sentitutako herstura-sentsazio hura. Ziegako bakardadean biluzten garenean, hor dago, azalera itsatsita daramagun beste jantzi ikusezin itogarria, espetxetik atera ondoren ere kenduko ote dugun ez dakigun bigarren azal likitsa.

Atzo eta gaur berdin, beti zainduta, intimitaterik gabe, barruko mundua besterik ez dugu askatasun-eremu. Borroka-eremu ere badena, gure baitan ere ez baitugu atseden-lekurik presook. Espetxearen helburua gaizkileak eta erreboltariak esa-

neko eta damutu bihurtzea denez, konkistatzailearen grinaz bilatzen du gutako bakoitzaren barruko lurraldeak menperatzea.

Izuz gogoratzen dut espetxean sartu eta hilabete gutxitara espetxearekin egindako lehenetariko amesgaiztoa: kartzelatik kanpo ateratzea lortu eta hiri handi batean nora ezean nenbilen beste burkide batzuekin. Berandu zen, kaleak husten ari ziren eta jadanik gure bila ibiliko ziren. Ez genbiltzan babesetxeren baten bila ordea, gure kezka kartzelako bidea aurkitu eta ziegak ixteko ordua baino lehen bertaratzea besterik ez zen. Ametsa gaizki bukatzen zen, noski, azken unean, nola ez dakit, gure ziegetara iristea lortu baikenuen!

Espetxeratu berritan, burkideen berotasunik gabe bakartzen duten presoa azala urratu beharrean saiatzen da arnas egitea zailtzen dion mintz hori erauzten.

**Giza harremanak ustelduta daude espetxean. Ag**
**Agindu eta obeditu. Bata Surveillant Jauna eta bes**
**zakurtxoari ere emango ez**

Borroka horretan emango ditu askatasunetik ekarritako indarrik onenak. Helburua lortu ez arren, lehen borrokaldi horri esker bederen barruko lurraldeak defendatzeko babes-jantzi sendoa ehunduko du. Kartzelako egonaldian makurtu gabe bizirauteko ezinbestekoa den babes-jantzia. Askatasuna soilik kentzen diguten aitzakiatan nortasuna eta gizatasuna ere kendu nahi baitigute. Bai baitakite hori dela lau hormen artean aske izaten laguntzen diguna.

Giza harremanak ustelduta daude espetxean. Agintedun eta menpeko. Giltzaduna eta giltzapetua. Agindu eta obeditu. Bata Surveillant Jauna eta bestea zenbaki. Kartzelako zuzendariak bere lagungarriko zakurñoari ere emango ez lioken tratua jasotzen duena.

Espetxean bizirauteko irtenbidetzat bigarren geruza estugarri horretara ohitzen saiatzen hasi eta segundo gutxi batzuen buruan ohartuko gara hautu horren ondorio larriez: sasi-azal berrira egokitzeko asmoz gogoa eta gorputza uzkurtzerakoan, sasi-azala are eta gehiago estutzen baita. Segituan ikasten dugu urak hartutako jantzi bat bezala laburtzen den azal horri atsedenik eman gabe egin behar zaiola aurre, norberaren baitako lurralde askea, duintasuna, gorde nahi bada.

Honetan datza bigarren azal horren bikaintasun txundigarria: bakarra izanik anitza da. Zigortu nahi dena gizakia denez, gizakiaren neurrira egindako asmakizuna da. Eta gainera harrapakin bakoitzari berez egokitzen zaio. Agintedunek norberaren izarikoa bilatzen ibili beharrik gabe. Hartara, espetxea guztientzat espetxe izanik, bere itxurazko uniformitatearen azpian, preso bakoitzarentzat beren beregi asmatutako nahi adina aplikazio berezitu ditu. Horrela, espetxeak den-dena kentzen die giltzapetuei. Eta gainera, norberak gehien maite eta behar duen horretan zauritzen du espetxeratua, vudu-panpina bati orratza sartuko baliote bezala: maiteminduari maitalea kenduz, gurasoei seme-alabak, seme-alabei senideak. Eta borrokalariari borroka-eremua.

Inon erabaki behar izan gabe, ad hoc asmatutako zigor bihurtzen da espetxea. Norberaren arimaren gotorlekuko azken zoko sekretuaren muineraino iristen saiatzen da.

Espetxe politika presoarentzat soilik diseinatua dagoela uste izaten dugu, baina Erdi Aroan gaizkileak sendiarekin batera lekutzen zituzten bezalaxe, XXI. mendean zigor-politika izena merezi duen batek ez ditzake utzi senideak eta lagunak zigortu gabe. Zigortzaileen buruan senideak eta presoaren ingurune afektiboa beti izan baitira gatibuaren egintzen nolabaiteko arduradun. Badakigu horretaz zerbait euskaldunok.

*"Zuri egiterik nahi ez duzunik ez diezaiozula hurkoari egin"* esapidea itzulikatuz Kartzela-Administrazioko buruek, politikariek, hautetsiek, eta jende prestuen mandatariek, gaizkileari *"merezi duena"* emateko zeregin gorena bereganatuz, beraiei egiterik nahi ez luketen horixe bera egitea ahalbideratzen duen moduko punta-puntako zigor-sistema eraiki baitute XVIII. mende amaieraz geroztik irauten duen hobekuntza prozesuaren buruan.

**gintedun eta menpeko. Giltza duena eta giltzapetua.
tea zenbaki. Kartzelako zuzendariak bere lagungarriko
z lioken tratua jasotzen duena.**

Presoek beren aldetik makina giza xehatzaileari aurre egiteko tresnak eta trikimailuak asmatu dituzte ere mendeotan. Burua tente ibiltzea, araudia betetzeari uko egitea, errefusa orokorrak, eskabideak, grebak, zain-mozketak...Kartzela-arduradunei beldur handiena eragiten diena eta horregatik gogorren zigortzen dutena mugimendu kolektiboa da. Hor baitago bakandu nahi gaituen espetxeari arrakastaz aurre egiteko gakoa.

Taldean goazenean bigarren azalaren indarra ahultzen da, aiseago arnas egiten dugu, irribarrea ezpainetaratzen zaigu. Presozainen urduritasuna nabarmentzen da. Norberaren babes-jantziaren indarra biderkatu egiten da. Norberaren zalantzak eta beldurrak uxatzen dira denok bat egiten dugunean.

Belfasteko kartzelan, Irlandako borrokalariek kriminalei ezartzen zizkieten jantziak janzteari uko egin zioten. Kaleko jantziak eskatuz eta beren gerra-preso izaera aldarrikatuz, estalki batez babestu zituzten beren gorputz biluziak. Estalki xume horren azpian, neurrira egindako jantzi estuegi haien josturak zartarazi zituzten eta pertsona aske izaten jarraitu zuten.

Guk aldarrikapen idazkundun nikiak janzteko eskubidea lortu dugu. Borroka egun berezietan Guantanamo-laranja koloredun nikia janzten dugu, Euskal Herriarentzat autodeterminazioa eta euskal presoontzat estatus politiko eskatuz. Korridorean goazela gure presentzia biderkatu egiten dela iruditzen zait. Borrokaren gainazala janzten dugunean zanpaketaren bigarren azal horren eragina apaldu egiten dela.

Joan den urteko apirilaren 18tik desagertuta dagoen Jon Anza burkidearen desagerpena salatzeko, *"Qu´est-ce vous qu'avez fait de Jon?"* idazkundun eta Jonen argazkidun niki horia janzten dugu ostiralero eta epaitegira goazenetan. Niki horren azpian ere zanpaketaren josturak nola nasaitzen diren nabaritzen dut, eta Jonen indarrak eta duintasunak borroka honetan irabazi arte tinko eusteko nolako adorea ematen didan sentitzen dut.






## ABUZTUAK 02

Jendetza bildu da Villabonan Remi Ayestaran gaztearen hilketa salatzeko burutu den manifestazioan.

## ABUZTUAK 04

Venezuelako Entzutegi Gorenak ez du onartu Iñaki Etxeberria euskal iheslari politikoaren estradizio eskaera.

## ABUZTUAK 04

Lizarran burutu den kalejira baten aurka jo du Guardia Zibilak, gazte bat atxilotuz eta beste hainbat zaurituz. Lizarrako hainbat gazteren aurkako jazarpena areagotuko da hurrengo hilabeteotan gertaera honen harira.

## ABUZTUAK 06

Juan Manuel Intziarte euskal iheslaria espetxeratu dute Mexikotik kanporatua izan ondoren.



## ABUZTUAK 07

Gaztesarearen aurkako polizia operazioa salatzeko ehunka lagun bildu dira Donostian. Manifestazioa debekatua izan da eta Ertzaintzak gogor jo du manifestarien aurka.




## ABUZTUAK 08

Milaka lagun bildu dira Donostian ezker abertzaleak deituriko manifestazioan. Manifestazioa debekatua izan da eta Ertzainak manifestarien aurka egin du bi lagun atxilotuz eta hainbat zauritu eraginez.











## ABUZTUAK 012

Sonia Polo Bilboko aste nagusiko txupinerari gutun bat bidali diote Bilboko udalera, bere argazkiarekin eta bala batekin.

## ABUZTUAK 013

Ertzaintza Getariako Herriko tabernan sartu da eta euskal preso politikoen argazkiak eta Anzaren desagerketa salatzen dituen kartela eraman ditu, hiru lagun identifikatuz.



## ABUZTUAK 014

Etxerat elkarteak ostiralero Donostian egiten duen elkarretaratzea eragotzi du Ertzaintzak senideen aurka kargatuz. 85 urteko pertsona bat zauritu dute pilotakada batez.








## ABUZTUAK 014

Iruñeako Donibane auzoan euskal preso politikoen eskubideak aldarrikatuz elkarretaratze batean parte hartzen ari ziren 20 herritar identifikatu ditu espainiar poliziak.







## ABUZTUAK 016

Gernikan euskal preso politikoen eskubideen alde burutu asmo zen manifestazioa debekatu du espainiar Entzutegi Nazionalak. Honen ordez kalejira bat egitea erabaki dute, baina Ertzaintzak gogor jo du herritarren aurka, Gernikako jaietako egun handian. Lau atxilotu eta gutxienez 20 zauritu eragin dituzte.




## ABUZTUAK 018

Euskal preso politikoen argazkiak erakusteagatik Espainiako Entzutegi Nazionalean deklaratu dute Iruñeako Ezpala eta Zurgai tabernetako nagusiek eta bi langilek.



**ABUZTUAK 019**

Alberto Matxain, Aitzol Etxaburu eta Andoni Sarasola atxilotu ditu frantziar poliziak Alpeetan.




**ABUZTUAK 020**

Ertzaintza Bilboko txosnagunera sartu da eta bertatik euskal presoen argazkiak, pegatinak eta pankartak eraman ditu besteak beste. 32 lagun identifikatu eta hainbat herritar jo dituzte.

## ABUZTUAK 020

Arbizuko hautetsien aurka heriotza mehatxuak margotuta azaldu dira udalatxearen aurrekaldean.




## ABUZTUAK 021

Ertzaintzaren kargak eta atxiloketak izan dira Bilboko Aste Nagusiko egun handian. Goizean konpartsek antolaturiko manifestazioaren aurka jo dute eta arratsaldean berriz senideen elkarretaratze baten aurka.











## ABUZTUAK 022

Ezkaba mendian 1936ko gerran Francoren aurka aritutako lagunen omenez eraikitako mausoleoa eta Aitzoaingo hilerrian errepresio frankista jasandakoen omenez jarritako oroitarria apurtu dituzte.

## ABUZTUAK 023

Iruñerriako Zurgai, Ezpala eta Ipar Gorri tabernetan mezu faxistak agertu dira Falangeak sinatuta.







## ABUZTUAK 024

Frantziako poliziak Iñaki Telletxea atxilotu du Hendaian lanerako bidean, frantziar estatuan bizitzeko duen debekua urratu duela egotzita.

## ABUZTUAK 027

Maite Aranalde Ibarrako preso politikoa libre gelditu da. Berari harrera egitera hurbildu diren herritarren aurka jo du Ertzaintzak, Maiteren senide bat atxilotuz eta beste bat zaurituz.






## ABUZTUAK 027

Berriozarko jaien hasieran 20 lagun identifikatu ditu Foruzaingoak presoekiko elkartasuna adieraztearekin terrorismoa goratzea egotzita.

## ABUZTUAK 029

Presoen argazkiekin kamiseta zeraman gazte bat identifikatu du Ertzaintzak Elgoibarren. Honen defentsan atera den gazte bat jipoitua izan da ondoren.

## ABUZTUAK 031

Maite Aranalderen baldintzapeko askatasuna bertan behera utzi eta berau bilatzeko eta atxilotzeko agindua eman du Baltasar Garzon epaileak.





## IRAILAK 01

Garzon epaileak 60.000 euroko bermea jarri die Nekane Erauskin eta Karmele Berasategi EHAK alderdiko legebiltzarkide ohiei espetxea ekiditeko aukera bakar bezala.




## IRAILAK 01

Kontsuelo Agirrebarrena atxilotu du Ertzaintzak Lizartzan eta Martuteneko espetxean sartu dute preso.

# GUDARIAK eta AMORANTEAK

Iñaki Soto

Europar ikuspuntu batetik, 2009 urtea errepresioari, *"terrorismoa"*-ri eta preso politikoei buruzko berri kontraesankor batekin amaitu da, eta berriaren protagonistetako bat, nola ez, euskal herritar bat izan da. Ez nabil, ez, euskal preso politikoek frantziar eta espainiar kartzeletan bizi duten egoera lazgarriari buruz, ezta euskal independentismoaren eztabaida estrategikoa zapuztea helburu zuten polizia operazioei buruz. Tamalez, gertaera hauek ia oharkabean igaro dira Europan. Kopenhageko Goi Bilkuraren testuinguruan Greeenpeaceko buru Juan Lopez de Uralde donostiarra Danimarkako hiriburuko kartzelara eraman zuten gertaerei buruz ari naiz.

Jende gehienak harriduraz hartu du danimarkar Estatuaren jokabide errepresibo gartsua. Lopez de Uralderen egoerak haserrea piztu du, oro har ageriko injustizia bat delako eta Dinamarkaz dugun irudi *"moderno"* eta demokratikoarekin bat ez datorrelako. Gutako askoren buruan, ordea, kasu honek eragiten duen konparazio maltzurra egon da. Bai, badira Europan egoera tamalgarrian bizi diren euskal preso politikoak, baina Lopez de Uralderena ez da, ez, kasu horietako bat. Kasuak eragin duen iskanbila Euskal Preso Politikoen Kolektiboaren egoera estaltzen duten iturri berberetatik etortzea da, gutako askorentzat, benetako eskandalua.

Nolanahi ere, nire asmoa ez da auzi zehatz hau aztertzea, baizik eta 2009. urtera arte Dinamarkan gauzatu den dinamika antierrepresibo bitxi eta nire ustez eredugarri bat azaltzea: Fighters and Lovers enpresak *"terroristen europar zerrenda"* delakoaren aurka egin duen kanpaina, hain zuzen ere.

Fighters and Lovers 2006. urtean sortu zen ekimena da. Ezkerreko zenbait alderdi eta sindikatutako hainbat kidek, *"terrorismoaren aurkako guda"* izendatu zen estrategiak



sortutako legedi bereziagatik kezkatuak, ekimen bat sortzea erabaki zuten.

Laburbilduz, Fighters and Lovers irudi moderno eta kolore bizidun kamisetak, elektronikarekin nahastutako kolonbiar musikako CDak eta perfumeak saltzen zituen enpresa gisa antolatu zuten. Danimarkako zenbait establezimendutan eta internet bidez saltzen zituzten produktu horiek. Produktuek berezitasun bat zuten: kamisetek FARC eta PLFP talde armatuen irudiak zituzten, musika FARCek kontrolatzen duen oihanetik zetorren eta perfumeak bi talde horien propaganda egiten zuen. Horretaz gain, salmentatik jasotzen zen dirua bi talde horiek kudeatutako proiektuetara zuzenduko zen, inprimategi bat palestinarren kasuan eta irrati bat kolonbiarrenean.

Ekimenaren helburua ez zen besterik gabe Latinoamerikako eta Ekialde Ertaineko herrialde horietako borrokak sustengatzea. Ikuspuntu politiko sakonago bat zegoen horren guztiaren atzean: europar testuinguruan salbuespenezko legedi errepresiboa kinkan jartzea, alegia, europar *"segurtasun"* politikaren oinarriak kinkan jartzea.

Hala, bada, helburuetako bat gatazka politiko bat sortzea zen, zeinaren ondorioz Dinamarkan zerrenda horren ilegaltasuna frogatzea lortu nahi zen. Ekimena publikoa zen eta danimarkar Gobernuari eta europar Administrazioari zuzendutako *"desafio"* gisa antolatzen zen. Hasieratik auzia tribunaletan amaituko zela aurreikusi zen, produktuak salgai jarri ziren unetik bertatik eskuineko alderdiek gogor egin zutelako ekimenaren aurka *"terrorismoa"* legitimatzen eta finantzatzen ari zela esanez. Horretaz gain, kolonbiar Estatuak ere gogor egin zuen ekimenaren aurka.

Borroka politiko hori eta, bide batez, auzi juridikoa kudeatzeko Fighters and Loverseko kideek printzipio orokor batzuk finkatu zituzten, gutxi gora behera honela laburbildu daitezkeenak:

-Europar zerrenda ez da legala. Sarri ahazten badugu ere, zerrenda hori Europar Komisioak bultzatu du, entitate administratibo ez demokratiko batek, alegia. Ez da epai edo legedi jakin batean oinarritzen, baizik eta AEBetako Administrazioaren, NATOren eta europar agintari jakin batzuen hautu politiko batean. Ondorioz, estatuek zerrenda honetaz egin dezaketen aplikazioa guztiz zalantzagarria da. Eskandinabiar testuinguruan, Norvegiak eta Suediak zerrenda horren izaera legala ukatu dute. Horretaz gain, bai zerrendan sartzeko bai bertatik atera ahal izateko mekanismoak zuzenbidearen aurkakoak dira, estatu interesen araberakoak baitira, eta ez dago juridikoki horien aurka egiterik. Ondorioz, esan den bezala, Fighters and Lovers ekimenaren azken helburua *"terroristen europar zerrenda"*-ren ilegaltasuna demostratzea eta haren ondorioak bertan behera uztea da.

-*"Segurtasuna"*-ren aldeko politika horiek, funtsean, demokraziaren, eskubideen eta askatasunen aurkako politika bat dira. Azken batean, gezurretan oinarritzen dira eta, gainera, ez dira gai ustez dituzten helburuak -segurtasuna bermatzea, askatasunak babestea...- betetzeko. Areago, kontrako efektua dute.

-Baldintza politiko jakin batzuetan, biolentzia politikoa edo erresistentzia armatua zilegi da. Kasu honetan, bai Kolonbian eta bai Palestinan bizi den egoera politikoak erresistentzia armatua zilegi ez ezik beharrezkoa ere badela uste dute Fighters and Loverseko kideek. Horretarako nazioarteko hainbat aditu eta entitateren txostenak kontuan izan behar dira, han gertatzen diren torturak, heriotza politikoak, errepresio sistematikoa eta eskubideen murrizketaren berri ematen duten txostenak, hain zuzen ere.

**Ekimenaren helburua ez zen besterik gabe Latinoame**
**sustengatzea. Ikuspuntu politiko sakonago bat zegoen ho**
**legedi errepresiboa kinkan jartzea, alegia, europ**

-Hautatutako kasuak, Palestina eta Kolonbia, lagundutako taldeak, FARC eta PFLP, eta finantzatutako proiektuak, liburutegia eta irratia, jatorri ideologiko eta diziplina politiko desberdinak dituzten kide hauen adostasuna lortzen dute.

-Europar testuinguruan eta, zehatzago, eskandinabiar testuinguruan, esperientzia historikoak erresistentziaren zilegitasun hau baieztatzen du. Bai II. Mundu Gerran bai espainiar errepublikaren alde erresistentzian aritu ziren brigadetako kideak honen lekuko dira. Zentzu honetan, Fighters and Loversek tradizio politiko honen oinordeko gisa ulertzen du bere borroka. Era berean, borrokaren ikuspuntu *"erromantikoa"* azpimarratu nahi dute. Hortik dator *"Gudariak eta Amoranteak"* izena, talde horien jarduna herrien eta pertsonen arteko maitasuna jomuga duten borroka gisa ulertzen baitute.

-Zerrendaren beste ondorioetako bat elkartasunaren kriminalizazioa da. Borroka demokratikoak laguntzea kriminalizatu nahi da eta horregatik erresistentzia talde horien finantziazioan jartzen da indarra, borroka horiek diruz laguntzea bereziki zigortuz. Ondorioz, Palestinako eta Kolonbiako proiektuen finantziazioaren bitartez, politika honen funtsari eraso nahi dio Fighters and Lovers-ek.

-Azkenik, testuinguru europarrean ulergarriak eta eraginkorrak diren erresistentzia formulak bilatu behar dira, funtzio pedagogikoa duten ekimenak bultzatuz. Historikoki ezkerraren baitan *"kontraesanak"* sortu dituzten elementuak erabiltzen dira hemen. Horietatik lehena, kontsumo

produktuak salduko dituen enpresa bat sortzea izan zen. Fighters and Loverseko kideek ondo ezagutzen dute bai Kolonbia bai Palestina, baina haiekiko elkartasun bideak Europan kokatutako ikuspuntu herrikoi batetik zabaldu nahi dituzte, Europatik atera gabe elkartasun hau bideratzeko aukera emanez.

Asko laburbilduz, hauek dira 2006ko abenduan Kopenhageko Poliziak Fighters and Loverseko bultzatzaileak atxilotu zituenetik 2009ko martxoan Danimarkako Auzitegi Gorenak sei aktibista terrorismoa egotzita kondenatu zituen arte Danimarkan izan den eztabaida juridiko-politikoaren ardatzak. Kondenak, nolanahi ere, 2 eta 6 hilabete arteko baldintzapeko kartzelakoak izan ziren. Tarte horretan, Kolonbiako eta Palestinako egoera salatzen duten adituen txostenen aurkezpena, Lene Espersen Justizia ministroak epaitegian erabili zituen eta tortura bidez lortu ziren frogei buruzko polemika, Israel eta Kolonbia herrialde demokratikoak ez direlakoan Kopenhageko Auzitegiak emandako absoluzioa, Kolonbiar Enbaxadaren esku-hartzea, Fiskaltzaren Gorenerako apelazioa edota Brigada Internazionalistetako beteranoen elkartasun adierazpenak izan ziren, besteak beste.

Merezi zuelakoan, gehienontzat ezezaguna den kasuaren deskripzioan luzatu naiz eta balorazioetarako tarte txikia geratu zait. Nolanahi ere, irakaspenak argiak dira, nire ustez. Europar zerrenda horretan zenbat euskal herritar eta erakunde politiko dauden jakinda (hau idazten ari naizen bitartean ANV eta EHAK alderdiak eta zenbait euskal herritar gehiago sartu dituzte bertan, espainiar Estatuaren eskariz), Euskal Herrian eskubide zibil eta politikoen egoera zein den ikusita, ez al litzateke ederra Oslon -edo Berlinen, edo Lisboan...- eratutako enpresa batek *"ANV 1944"* Eau de Toilette, *"Freedom-Askatasuna"* lemadun kamisetak, edo *"European DJs against torture"* CDa salgai jartzea?

**rikako eta Ekialde Ertaineko herrialde horietako borrokak orren guztiaren atzean: europar testuinguruan salbuespenezko par "segurtasun" politikaren oinarriak kinkan jartzea.**

Bitartean, esan dezagun ozen:
amoranteak dira, ez terroristak.





## IRAILAK 04

Baztanen presoen alde bildutako 30 lagunak identifikatu eta ordubetez atxiki zituen Guardia Zibilak.

## IRAILAK 05

Hernanin burutzekoa zen futbito txapelketa eta mus txapelketa debekatu ditu espainiar Entzutegi Nazionalak eta futbolariz jantzitako herritarren aurka oldartu da, gutxienez bi lagun zaurituz.



## IRAILAK 06

Ertzaintzak bederatzi lagun atxilotu ditu Lekeition eta atxiloturik izan dituzten bi egunetan jipoituak izan direla salatu dute. Antzar egunean goizetik Ertzaintzaren presentzia nabarmena izan da, presoen argazkiak zeramatzaten argazkiak kenduz aritu direlarik. Gau osoan istiluak izan dira.



## IRAILAK 07

Gaztesarearen aurkako polizia operazioari loturik hainbat gaztek deklaratu dute egunotan espainiar Entzutegi Nazionalean.

## IRAILAK 08

Eusko Jaurlaritzako herrizaingo sailak debekatu egin du estropaden egun handian euskal preso politikoen eskubideen alde egitekoa zen manifestaldia.






## IRAILAK 011

Euskal presoen argazkiak kentzeari uko egin ondoren Donostiako Marruma tabernako administratzailea eta zerbitzarietako bat espainiar Entzutegi Nazionalean izan dira deklaratzen.



## IRAILAK 012

Estropaden egunerako deitua zegoen manifestazioa debekatua izan ondoren Etxerat elkarteak deituta milaka lagun bildu dira Donostian euskal preso politikoen eskubideen defentsan.

## IRAILAK 013

Estropaden egun handien Donostiako alde zahar inguruak euskal preso politikoen argazkiz josita agertu dira. Une batean alde zaharrean sartu da bertan zeuden mila herritarren aurka kargatuz.

## IRAILAK 015

Berriozarko txupinazoaren inguruan Foruzaingoak egindako txostena Espainiako Entzutegi Nazionalera helarazi dute.

## IRAILAK 017

Baionako Auzitegiak 1000 euroko isuna ezarri dio Iñaki Telletxea iheslariari Frantziar estatuan sartzeko debekua urratu izanagatik.









## IRAILAK 019

Hamar gazte atxilotu ditu Iruñean Espainiako Poliziak udaltzaingoaren laguntzarekin, Alde Zaharreko gazte egunean presoen argazkiak zeramatzan pankarta jartzea egotzita.

## IRAILAK 020

Guardia Zibilak Bat Egin Egunera bertaraturiko ehunaka lagun identifikatu ditu.

# ELKARTASUN EGUNA '09

## ARRALDEN

**Irailak 19 Larunbata**





**MAITE ZAITUZTEGU!**

**11:00etan Pala Txapelketa pilotaleku estalian.**
**14:00etan BAZKARI HERRIKOIA aterpean:**
- **Entsalada, saiheskia eta postrea.**

**18:00etan MANIFESTAZIOA Iturritik eta ondoren EKITALDI POLITIKOA.**
**22:00etan KONTZERTUA Gaztetxean:**
- **Satarrak.**




**EUSKAL PRESOAK EUSKAL HERRIRA**

**IRAILAK 020**

Goenkaleko telesaileko Arralde herrian egitekoa zen presoen aldeko ekitaldia debekatzeko eskatu du Dignidad y justiciak. Garzonek Guardia Zibilak bidali ditu Bizkaiako Arralde mendira.

## IRAILAK 022

Falange y Tradicion taldeak bere gain hartu ditu azken hilabeteotan Euskal Herrian burutu diren hainbat ekintza faxista.

## IRAILAK 023

Mikel Barrios eta Joseba Iturbideren aurkako euroagindu eskaerak atzera bota ditu Paueko epaitegiak. Iturbideren kasuan Portu eta Sarasolaren tortura salaketak argitu arte bere aurkako euroagindua ez onartzea erabaki du. Barriosen kasuan informazio gehiago eskatu du.






## IRAILAK 024

Ertzaintza Arrasateko bost tabernetara sartu da euskal preso politikoen argazkien bila.

## IRAILAK 024

Iñaki Azkunak jakinarazi du presoen argazkiak daramatzaten txosnek ez dutela baimenik izango 2010 urtean berriro beraien txosna jartzeko.



## IRAILAK 025

Eusko Jaurlaritzako Herrizaingo Sailak jakinarazi du Etxerat elkartea legez kanpo uzteko lanean ari dela.







## IRAILAK 026

Gudari egunaren harira burutzekoak diren hainbat ekitaldi eta mobilizazio debekatu ditu espainiar Entzutegi Nazionalak. Hala ere, ehunaka lagun atera dira kalera.




## IRAILAK 026

Pakito Arriaran hil zutela 25 urte bete direnean bere omenezko ekitaldiak debakatu ditu espainiar Entzutegi Nazionalak.



## IRAILAK 027

Zarautzen Txikiren hilobian Ahaztuak elkarteak antolaturiko omenaldia galarazi du Ertzaintzak.

**IRAILAK 028**

Terrorismoa goratzea egotzita Berriozarko Udaleko EAE eta ANVko hiru zinegotzien aurkako salaketa jarri zuen espainiar Entzutegi Nazionalak.

**URRIAK 01**

Marian Beitialarrangoitia Hernaniko alkatea kargutik kentzeko agindu dio udalari Estatuko Abokatutzak.





**URRIAK 02**

Sei Ertzain Oreretako Herriko Tabernara sartu eta gazte bat atxilo eraman dute, lepotik tiraka eta modu basatian.

**URRIAK 03**

Poliziaren jarraipen itogarrien harira Durangaldeko gazte batek salaketa judiziala jarri du hirugarren aldiz.





**URRIAK 04**

Presoen argazkiak zeramatzaten kartelak jartzea egotzita bi lagun atxilotu ditu Ertzaintzak Donostian.

**URRIAK 06**

Aitor Jugo euskal preso politiko ohiari egindako harreraren aurka jo du Ertzaintzak, bi lagun identifikatuz eta hainbat herritar kolpatuz.





# RECISTER

*Mikel Peruarena*

Narrazio bat daukat eskuetan, eta ez dakit nola idatzi.

Istorioa beti goizaldean hasten da, hori gauza nabarmena da, eta lauzpabost egun geroago amaitzen da, epaile baten aurrean normalean. Tartean, mehatxuak daude, irainak kolpeak eskuburdinak eta izua.
Protagonista, gaztea izan ohi da, gauza nabarmena. Antagonistak, berriz, bat baino gehiago dira, ondo armatuak, metropoliko hiriburutik heldu diren aginduak betetzeko pronto.
Kokapenerako, aukera bat baino gehiago dauzkat eskuetan: protagonistaren etxea izan liteke, beltzez tindaturiko berinak dituen automobila, edo polizia etxea. Berdin balio du. Kartzelan ere konta liteke istorioa. Kokapen faltagatik ez da izango. Han, edo hemen, erraz idatziko nuke, nola esan jakingo banu.
Garaiak ez du garrantzia nabarmenik. Bezperan edo iaz gertatu balitz ere ez lioke axolarik, 1969ko neguan, 1982ko udaberrian. Aukerak ugariak dira; ugariegiak. Akaso horregatik izango da ez dakidala nola idatzi eskuetan dudan kontakizun hau, aukerak anitzak direlako.

Anitzak dira arriskuak, eta idazlea ez da beti orrialde zuriaren aurrean beldurtzen. Batzuetan, orrialde beteak izutzen du. Letraz betetako orri horrek, izan ere, ezertarako balioko du? Ezer berririk esango dio irakurriko duenari?
Batzuetan idazten hasi aurreko beldurra baino, idazten amaitu ondoreneko izua gailentzen zaio idazleari:

- Zer esango behar duk hik, inozente hori? Ezer interesgarririk asmatuko duk gaur?
Material guztiak dauzkat narrazio bat atontzeko, eta ezin dut. Batzuetan ez da aski protagonista, istorioa eta gatazka, kokapena eta garaia argi edukitzea. Batzuetan eskuak elbarritu eta txindurritu egiten dira. Ez orriaren zuriagatik, orriaren beltzagatik baizik. Beltzagatik.

- Ez. Ez duk eskua txindurritzen dena, eta badakik. Ez gezurrik esan: eskuari agintzen dion garun hori duk elbarri dagoena. Arrazoi du.
Atxiloketa bakoitzak aurreko guztiak berritzen ditu. Bide estra-



ta gero eta zanpatuagoetan barneratzen da adimena. Gero eta zanpatuago dauden bideak, gero eta ibiliago, gero eta sakonago. Zail da jauzi bat egin eta senda zapaldutik irteten, ubide itxurako bide horretatik ateratzen, garamatzan ubidetik jalgitzen.
Idazten hasi eta atzera egiteko agintzen dit buruak, azaroaren 24an eta martxoaren 31n atxilotu zituzten gazteekin akordatzen banaiz, Espainiako Salbuespen Auzitegiaren aurrean deklaratu nahi, baina hark utzi ez eta atxilotzeko arriskuan daudela salatu duten dozenaka gazteekin akordatzen banaiz.

- Akaso ez duk narrazio bat, idatzi nahi duan hori...
Arrazoi du. Akaso kronika bat idatzi behar nuke.
Baina kronikak ja idatziak daude. Kronikak eta kronikak pilatzen dira, urteen eta mendeen arteko bazterreko tiraderan, ja ahaztuak dauden kronikak, alferrik idatzi zirenak, ezer irakasteko balio izan ez zutenak.

- Ez hadi tragiko jarri, arren!

Bueno, hori ere hala da: kronikak idazteak baino gutxiago balio du negar egiteak.
Akaso antzerki obra bat idatzi behar nuke, parodia bat, kalean antzeztekoa, barre egitekoa, barre askatzailea alegia, gure neurosi psikotiko kolektiboaren askatzailea alegia.
Barreak, beti izan dira oso iraultzaileak.

- Eta oso krudelak.
- Arraioa! Ez dago zurekin lan egiterik!
Zer da esku artean dudana? Nobela bat, poema bat? Zer egin nahi dut? Eskultura bat? Epopeia bat, tragedia bat? Film bat?

- Ez bahaiz hasten, ez duk sekula ezer egingo...
Filma izatekotan, Minority Report izan zitekeen. Polizia guztien ametsa: krimena egin aurretik atxilotzea delitugilea. Filmak egiten zuen, ordea, polizia batek sekula bere buruari egingo ez liokeen galdera bat: posible dira delitugileak, krimenik ez bada?
*"Orain delitua pertsonak dira"*, esan du abokatu batek, "*ez atxilotuek egin dutena*".
Akaso prentsa ohar baten izena du eskuenetan dudan zera honek. Akaso ez da literatura izango, salaketa bat baizik: J'accuse...

- Ez hadi tronpatu, oso prentsa txarra ditek prentsa oharrek.
Beharbada komikia izan liteke.
Ikus dezaket gure superheroia, Bilboko zeru harramazkarietara igota, atxiloketa prebentiboak saihesteko borrokan.
Edo, itxoin pixka batean... Hobeto oraindik: atxiloketa prebentiboak egiten dituen superheroi bat. Askoz hobeto. Oso ideia ona dira atxiloketa prebentiboak. Nonbaiteko barne ministro edo herrizaingo sailburu izango banintz, egunero sinatuko nituzke atxiloketa prebentiboak, gosaldu bitartean: petrolio ustiatzaileak, adibidez, gerra gehiago sortarazi ez dezaten; botiken industriako buruak, esaterako, Afrikan esperimentuak egiten eta iraungitako botikak saltzen milaka pertsona hil ez ditzaten... Armagintzarako lan egiten duten industrialak atxilotzeko aginduko nuke, eta lantegiak miatzeko eta ixteko, hartara munduko hilketen indizea %80 gutxituko bailitzateke supituan...

- Uste diat kontraesanean sartzen ari haizela heure buruarekin...
- Tira, komiki bat besterik ez da!
Ez. Ez da serioa. Oso ideia ona dira atxiloketa prebentiboak, norbere larruan bizitzea tokatzen ez den bitartean. Lehergai-

Iuak bezalakoak dira atxiloketa prebentiboak: ez zaizkio inori inporta, sudurren aurrean zartatzen ez diren bitartean.
Eskuetan dudana oso serioa da, txorakerietan hasteko.
Saiakera bat egin behar nuke agian, saiakera serio bat. Joxe Azurmendiren Gazte eroak, edo antzeko zerbait, bertsio aktualizatu bat:

*Etorri ziren denok dakigun gazte zoro batzuk eta mundu baketsu, dena txukun-txukun atondu hura, hankaz gora jarri zuten. Alegia, askotan ematen du, Francoren aurka denok etengabeko borroka heroikoan aritu omen ginela. Frantzian denak lehen-lehenengo ordutik Erresistentzian egon omen ziren bezala. Baina egia, 1964ean "25 años de paz" ospatu zela da, goi-goitik. Eta astia daukanak estudiotxo bat egin lezake nola ospatu zen, eta zer esaten zen bakearen santuaz eta bizitzaren sakratuaz eta aurrerapen eko nomikoaren sakrasantuaz, orain bezalaxe. Eta orduko kazetariek, profesional hutsak zirenek, oraingoak bezalaxe, eta besterik ez, Diario Vasco eta El Correo Español-en zer idazten zuten, profesionalen objektibitate huts-hutsarekin. Eta orduko gudari ohiek zer irakurtzen zuten egunero-egunero, oraingoek bezalaxe...*

Bai, serioa da Azurmendi, umore ukitua ere baduen arren:
Hona lehen puntua: ez dezagun iragana idealizatu.

*Gu historia pobre batean jaio ginen eta ume pobreak izan ginen. Gure gurasoak ez ziren heroi handiak. Gaur bezalaxe, konforme asko bizi ziren agintzen duenarekin, euskaldunak beti egin duen eran. Eta gehien-gehiengo beti konforme horren ondoan, Nemesio Etxaniz bezalako zoro gutxi batzuk eta haien ondoan gazte ero bakan batzuk bakarrik izan ziren, orduan ere, mugitu zirenak.*

Eta serioa da esaten duena, inork entzungo balu beste aldean...
Oraingo gazteak ero hutsak direla, denok badakigu. Eta zer ziren gazteak, orain aitonatxoak garenon *"gure garaian"*?

- Ez zekiat ikusten duan arazoa non dagoen, tokaio...
- Zer arazo, ordea?
- Hori ja idatzia zagok.

Bai, hainbeste gauza esaten dira...
Horiek ere esanda daude.
Akaso kanta bat behar genuke, *Gu gira Euskadiko gazteri berria*, edo *Gu gazteok gaur gabiltza mundu galdu honetan*, edo halakoren bat.

- Kanta horiek ere, ez dituk ba oso gazteak...

Bai. Kanta haiek ere zahartu egin dira, kantatzen zituztenekin batera, eta mundua ez da ja haiena, trenean eta autobusean sakelako telefonoetan hip-hopa entzuten datozen hauena baizik.
Egia guztia esateko, ez nuke ezer idatzi behar. *"Dena zen berria (...), beharbada gaztea izatea dena deskubritzea delako arrazoi sinpleagatik baino ez bazen ere"*, idatzi du Azurmendik. Zerbait errepikatzen ari dela ?déjà vu sentipen hori? azalean sentitzen hasten denean uzten dio batek gazte izateari.
Ez da zuzenago gazteek idaztea, gazteez?

-Gutun bat idatzi behar hieke.
Behin, gutun bat idatzi nion kartzelan zegoen gizon helduago bati. Konfidentzia gisako bat egin zidan, nik ordura arte usaindu ere ez nuena egin, seguruenik oraindik oso gaztea nintzelako. Belaunaldien arteko gatazkaz hitz egin zidan.
Gurasoak hil behar dituzte seme-alabek. Hala izan da beti, eta hala izango da gero:

**Filma izatekotan, Minority Report izan zitekeen. P
delitugilea. Filmak egiten zuen, ordea, polizia bat
posible dira delitug**

Beharbada Kronos (...) ez da Goyak pintatu duen agure zahar terriblea, umeak jaten, eta bai mutil gazte harro bat agure zahar gaixoak jaten?
Azurmendi, berriz.

*Neska-mutil gazte harro horiek behar ditu gurpilak, atso-agure zaharrak jateko. Nola zen poema hura? Beti ur berria isurtzen zuen iturri zaharrarena...*

- Isilik egon hadi, tunante hori, 30 besterik ez dauzkak eta!
- Aizu! 31 dauzkat.

Zenbat urterekin libratzen da bat Poliziaren jazarpenetik?

- Ez. Galdera okerra egiten ari haiz. Ez duk adin kontua, izpiritu kontua baizik.
- Bueno, izpiritua... Mistiko jarri beharko dugu, beraz. Zer nahi duzu idaztea, panfleto bat?
- Gizajoak Poliziarengandik libratzearekin amets egiten dik!

Poliziaren jazarpenari iskin egiteko modu bakarra dagoela okurritzen zait: irabazi eta Polizia desegitea, irabazi eta legeak desegitea, irabazi eta arauak aldatzea. Zer dio Azurmendik?

*Estatu liberalaren xede esentziala askatasuna bada (...), Estatu faxistaren esentzia Zuzenbidea eta Legea da. Faxistak beti harrotu dira beren Estatua legearen eta ordenaren prototipoa bezala proklamatzen. Ez askatasuna, Legea da Estatuaren esentzia.*

Bai, Legeari zaio begirune osoa, gure garaiotan.
Seinale txarra.
Legeak duen prezioa, askatasuna: aspaldiko balantza. Ez ote den balantza hori, justiziaren estatua hotzak dilindan eusten duena... Isurtzen ari den gazteria berriak besapean dakarren arautegi berria, ez ote den hori balantza itzulipurdikatzen duena...
Batek daki.
Ontzen utzi behar zaie belaunaldiei.
Zahartzen direnean ikusiko da zer ekarri zuten besapean.
Ez dakit hau zen idatzi nahi nuena.
Hala izango da, idatzi dudanerako...

- Zer iruditu zaizu?
- Ez zekiat ba... Bukaera horrekin...
- "Bukaera horrekin", "Bukaera horrekin" ... Sekula ez zaude gustura bukaerekin!
- Indarra falta zaiok.
- Dena ez da bukaerarengatik neurtzen; tartekoak ere badu bere balioa, bere indarra.
- Hirekin alferrik duk. Beti nahi duana egiten duk azkenean. Esan diat aipatu behar huela, nonbait, Marie Durand.
- Durand?
- Bai, 16 urterekin kartzelan sartu eta 39 urtez han eduki zuten emakume hugonotea.
- Noizko kontuekin ari zara, ordea? Inori ez zaizkio historiako liburuak inporta. Curriculumetatik ezabatzen ari dira eta!
- Ixo! Betiko kontuez ari nauk ni, ez historiako liburuez. Ahaztu zaik zer eskatu nian?
- Ez ez zait ahaztu.

Kondairaren arabera, ezten batekin *recister* idatzi zuen Durandek presondegiko hormetako batean.

- Eta? Kasu egin didak? Sartu duk *recister* hura nonbait?

Sartu dut, bai.

## olizia guztien ametsa: krimena egin aurretik atxilotzea
## tek sekula bere buruari egingo ez liokeen galdera bat:
## ileak, krimenik ez bada?



## URRIAK 07

Berriozargo Udaleko ezker abertzaleko hiru zinegotziak Espainiako Entzutegi Nazionalean izan dira deklaratzen txupinazo egunean presoei elkartasuna adierazi izanagatik.







## URRIAK 010

Frantziar Poliziak Ibai Sueskun atxilotu du eskuan bala zauri bat duela.

## URRIAK 011

Frantziar poliziak eta Guardia Zibilak elkarlanean buruturiko operazioan Joanes Larretxea eta Iurgi Mendinueta atxilotu dituzte.




## URRIAK 011

Faxismoaren aurkako mobilizazioan parte hartu duten herritarren aurka jo du poliziak eta sei lagun atxilotu dituzte eta hainbat lagun zauritu dituzte.

## URRIAK 012

Ehunaka lagun kalera atera dira hego Euskal Herriko hiriburuetan, faxismoaren eta gerra zikinaren aurka.






## URRIAK 013

Espainiar poliziek hamar lagun atxilotu dituzte ezker abertzalearen aurkako polizia operazio berri batean.





**URRIAK 016**

Amnistiaren Aldeko Batzordeen eta Askatasunaren aurkako epaia berretsi du espainiar Entzutegi Gorenak eta zortzi lagun atxilotu eta espetxeratu dituzte.

**URRIAK 017**

Milaka lagun kalera atera dira Donostian ezker abertzalearen aurkako azken polizia operazioa salatzeko.




**URRIAK 019**

Frantziar Poliziak Aitor Elizaran eta Oihana San Vicente atxilotu ditu Bretainian.






**URRIAK 021**

Josetxo Otegi euskal preso politikoa frantziar estatutik kanporatua izan da kondena bete duen egunean. Hainbat egun eman ditu gose greban, eta azkenean libre utzi dute Barajasen.

**URRIAK 021**

San Fermin eta Armonia Txantreanako bi kidek inputatu moduan deklaratu dute espainiar Entzutegi Nazionalean, San Ferminetako pankartetan *terrorismoa goratzea* egotzita.






## URRIAK 022

Karmelo Landaren atxiloketa eta espetxeratzea arbritarioak izan direla ebatzi zuen Bidegabeko atxiloketak aztertzen dituen NBEko batzordeko lan taldeak.

## URRIAK 024

Ertzaintza Balmasedako txosnetan sartu da eta bertan zeudenei presoen argazkiak kentzeko agindu die. Hauek horretara ukatu ondoren identifikatuak izan dira.





## URRIAK 026

Frantziako poliziak Zuhaitz Errasti atxilotu du arratsaldean Poitiers inguruan.

## URRIAK 026

Guardia Zibilak Lesaka okupatu du euskal preso politikoekiko elkartasuna adierazteko antolatua zegoen martxa ekiditeko.



## URRIAK 028

Espainiar Entzutegi Nazionalean Asier Tapia, Araitz Zubimendi, Zigor Ruiz, Eneko Aizpuru eta Garikoitz Mujikaren aurkako epaiketa hasi da.



## URRIAK 028

Frantziar poliziak Joseba Agudo atxilotu du eta Guardia Zibilek bere gurasoen etxea miatu dute Oreretan. Bera atxilotu aurretik bere atxiloketaren berri eman dute komunikabide espainiarrek.



## URRIAK 030

Eneko Aizpuru eta Garikoitz Mujika epaiketaren azken saioan espetxeratuak izan dira. Ondorengo egunetan epaituak sei urterako espetxeratuak izan dira.

## AZAROAK 02

Joseba Gonzalez Pabon iruindarra bost urteko espetxe zigorra osorik bete dezan espetxeratua izan da.



## AZAROAK 07

Euskal preso politikoen senide ugari bisitarik gabe gelditu da funtzionarioen aldetik miatzeari uko egin ondoren.





## AZAROAK 011

Estrasburgoko auzitegiak espainiar estatuaren legez kanporatze estrategia babestu du Batasuna, HB, AUB, HZ eta 218 herri plataformen legez kanporatzea berretsiz.

## AZAROAK 011

Frantziar poliziak Aintza Zufiaurre eta Annton Rouget atxilotu ditu frantziar bandera bat ostea egotzita. Hurrengo egunean Andoni Anetas atxilotuko dute berdina egotzita.



## AZAROAK 011

Atarrabiako 19 lagunek 6000 euroko isuna jaso dute 2006an Autodeterminazioaren aldeko kotxe karabana batean parte hartu ondoren.




## AZAROAK 011

Pagoa Zulueta preso sartu dute espainiar Entzutegi Nazionalak ezarritako sei urteko zigorra bete dezan.

## AZAROAK 014

Igorreko gazte batek salatu duenez Guardia Zibil bezala aurkeztu eta burua estalita zeramaten armadun aldetik jazarria izan zen. Eskuburdinak jarri, pistola erakutsi, jo, eskuan bala bat jarri eta kolabora zezan mehatxu egin zioten.





## AZAROAK 017

Asier Olano, Mikel Gartzia eta Jon Ezeiza hernaniarrak libre gelditu ondoren gazteoi harrera egitera hurbildutako herritarren aurka gogor jo du Ertzaintzak Hernanin.




## AZAROAK 018

Josu Muguruzaren omenez Bilboko Errekalde auzoan dagoen oroitarria pinturaz erasotu dute ezezagunek.





## AZAROAK 019

Espetxealdi arindua ezarri diote Belen Gonzalezi, hilabete lehenago minbizia diagnostikatu ondoren.

## AZAROAK 020

Aitor Olaizola, Oier Llorente eta Adur Fernandez libre gelditu ondoren Ertzaintza beraiei harrera egitera hurbildu diren herritarren aurka oldartu da.






## AZAROAK 024

Gazte independentisten aurkako polizia operazioan 34 lagun atxilotu ditu espainiar poliziak eta beste 10 atxilotzen saiatu da gutxienez. Atxilotuak inkomunikatuak, torturatuak eta sexualki jazarriak izan dira.







## AZAROAK 025

Kaskagorri eta Txori Barrote konpartsek datozen bi urteetan ezingo dute Txosnarik jarri, Bilboko udalak horrela erabakita.

## AZAROAK 027

Gasteizko udaltzainek bi gazte atxilotu dituzte polizia operazioaren ondoren Gasteizen burutu den mobilizazioaren ondoren kalean istiluak eragitea egotzita.








## AZAROAK 028

Milaka lagun bildu dira Bilboko kaleetan gazteen aurkako polizia operazio salatu eta proiektu eta eskubide guztiak aldarrikatzeko.

# REMY MARTIN

*Joxean Agirre*

Ezagutzen zutenen iritziz, pertsona aparta zen Remi Aiestaran. Egia esan, hil eta gero inor gutxitaz hitz egiten da gaizki. Norberaren merituak handiak edo txikiak izan, beti nabarmentzen dugu gogoan eduki beharrekoa, dohainak batik bat. Gure hezkuntzaren usadio kristau-judutarrak pisua dauka oraindik, eta errukitzen gara maiz: nahikoa dauka, gixajoa, hiltzearekin, ez dezagun bere oroimena lohitu kontu eskasekin.

Dena dela, Villabonan egon den edonork badaki Remiren itzala ikaragarri handia dela. Edonondik hartzen zuen argia, eta prestutasun hura leku guztietara zihoan berarekin: udaletxera, lanera, koadrila giroan,... Pertsona osokoa zen. Herriko festetan hil zen Remi Aiestaran. Jai giroa ekaitz giro bilakatu zen eta arantza zizt sartu ziguten. Ertzainek ez zioten utzi jai giroa lasai dastatzen. Hileroko azken ostiraletan bezala, euskal presoen eskubideen aldeko elkarretaratzea deituta zegoen uztailaren 31n, plazan. Espainiako Auzitegi Nazionalak debekatu egin zuen, eta Ertzaintza bertaratu zen iskanbila gogoz. Plaza hartu zuten aurpegia estalita, kasko, borra, pilotak jaurtitzeko pistola eta abarrekin. Nabarmena zen tentsioa, eta elkarretaratzea ez egitea erabaki zuten. Jendeak jaia nahi zuen eta probokazioari izkin egitea aukerarik hoberena zen

Ondoko plaza berrian jaietako kontzertuak hastekoak zirela-eta, jendea hurbiltzen hasi zen. Ertzainek, telebista kameraz inguraturik bide bera hartu zuten, nonbait, aginte makila nork zuen erakusteko aukera egongo zela pentsatuz. Aiestaran hurbildu egin zitzaien, alkateordea zela esan, eta han kontzertuez gain ezer ez zegoenez, joateko eskatu zien. Remiren zintzotasunak ez zuten eskertu, ordea, eta Ertzaintza zirika eta oldarka hasi zitzaion.



Armada beltz haren nagusia zirudiena Aiestarani galderak egin eta egin hasi zen. Zein musikari ziren, nongoak ziren... Remi eskarmentuzko laguna zenez, ez zion betarik eman, eta ez erantzutea deliberatu zen, ezer ez zekiela behin eta berriro esanez. *"Gustatuta nago zurekin"*, esan zion halako batean, gaztelaniaz, ertzain-buruak. Bistan zen Villabonako lasaitasuna apurtzera etorriak zirela, eta kosta ahala kosta nahi zuten karga ahalbideratuko zukeen aitzakia bat topatzea. Hori ikusita, tentsio girotik apur bat aldendu eta ertzainen alkantzutik ospa egin zuen Remik. Handik minutu gutxitara, ibaiaren ondoan dagoen pasealeku berria elkarren jarraian etorri ziren estutasunak. Aortako aneurisma batek ezerezean utzi zuen arnasa itzuli zekion lagunek egin zuten saiakera. Klinikan hilik ingresatu zuten.

*"Bihotza itzali zizutenek ez dute sekula zure irribarrea itzaliko"*, esan zuen Esti bere lagunak Villabonako plazan. Betagarriren abesti ezagunaz akordatu nintzen une hartan: Izotzak bihotza itzaltzen du... Hiltzen banaiz ez zait inporta, baina hiltzen bada nire kausa ezertarako hil nintzen. Gero, herria eta bisaiak ilunduta zeudela, kotxea hartu eta etxerako bidea hartu nuen.

Uda bere azkenetan zegoela, nire bizilektuk nahiko gertu dagoen taberna batera jaitsi nintzen gosaltzera. Asteburuko ohitura izanda, egunkaria patxadaz hartu eta kafe ebakia hoztu arteko irakurraldi luzea egin nuen. Barrara hurbildu nintzen eta, oraintzeko txanponekin asmatu nahian nenbilela, botilen artean zegoen oroigarri txiki bati erreparatu nion: Remirena zen. Tabernako jabeari zuzen-zuzen galdetu nion: *"Ezagutzen al zenuen Remi Aiestaran?"*. Ezker- eskuin begiratu ostean, ahapeka erantzun zidan: *"Asko ez, garagardoa ekartzeaz; baina hain harreman txikia izateko, egundoko konfiantza eta alaitasuna ekartzen zizkidan goizero. Oso maitagarria zen, eta horregatik, bere omenez, Remy Martin koñak botila ondoan utzi dut bere oroigarria. Nik hala deitzen nion-eta"*. Jende xehearen mintzaerak ez du izaten lizentzia poetikorik, baina aski sakona ohi da.

Badira, izan, ezer gutxirekin konkistatzen gaituztenak. Bestetzuk, aldiz, zenbat eta ezagunago orduan eta urrutiago nahiago. Bere kaputxa azpitik harroputzez jardun zuen ertzain hura halakoxea izango zen. Bistan eramaten duten gorputza atal bakarra begiak izaten dira, baina bizigabeak dauzkate. Gorrotoa ere antzematen zaie noizbehinka, baina egoera arruntetan bi kristal bola besterik ez dirudite. Remi hil eta berehala izango zuten ezbeharraren berri. Oraindik furgoneta barruan egongo ziren seguraski, eta jakinmina daukat Villabonako gazte xumearen aurrean hain bulartsu jokatu zuen zipaio haren erreakzioa nolakoa izan zen. Taupaka sentitu zuen bihotza? Etsai bat erditik kentzen duen gerlariaren bozkarioak hartu zuen gotik behitik? Pena? Ezaxola?

Hoztasuna agertzen digute baita tiro egiterakoan ere. Dagoeneko, 17 euskal herritar hil ditu Ertzaintzak, ehunka larri zauritu eta milaka makildu. Arrazoi politikoetan oinarritutako atxiloketetatik bostehun inguru inkomunikatuta izan dira, eta pertsona horien artean 264 tortura testigantza jaso dira. Eta halere, besteen indarkeriaren biktima soinekoan eroso sartzen dira, eta hori ulertzeko, egun hartan Villabonan gertatu zenaren gaineko bertsio ofizialari kasu

egitea besterik ez dago. Haiek jai gunera ez zirela hurbildu esan zuen Herrizaingo Sailak. Remiri gertatutakoak ez zuela zerikusirik Ertzaintzarekin. Herrizaingo Sailaren bertsioa komunikabideen bitartez jakin zuen familiak eta egun, ofizialki behintzat, inork ez die gertatutakoaren inguruko azalpenik eman. Haiengana ez da inor ere etorri.

Aiestaran hil eta hurrengo ordu eta egunetan hainbat alditan egon nintzen Villabonan. Guztietan manifestazioa egin zen, eta batzokiaren ondotik egunero igaro ginen. Lehen unetik bertoko ikurriña masta erdian eta dolu-xingolarekin ikusteak harritu ninduen. *"Kontxo -esan nuen nire baitarako- hauek behintzat odoloa dute zainetan eta bertsio ofizialaren gezurrari lotsa apur bat sikiera jarri diote"*. Oker nenbilen.

Herriko EAJren udal taldearen jarrera ere penagarria izan zen. Heriotza salatzeko udal batzarra deitu zuen ezker abertzaleak, baina EAJko ordezkariak ez ziren agertu. Ohar bidez kaleratu zuten ez zitzaiela iruditzen nahiko arrazoi zegoenik udal batzar berezia egiteko. Zerk bihurtuko du *"ez ohiko"* Villabonako jelkideen egunerokotasuna? Senideek kontatu zutenez, hiru egun behar izan zituzten familiarengana hurbiltzeko. Hileta elizkizunean gerturatu zitzaion bozeramailea amari, doluminak ematera. Ordurako ehunka ziren hil-kapelatik pasatutako lagunak, ezezagunak eta kanpotarrak barne. Jose Joaquin, Margari, Estitxu, Mikel eta Ane han zeuden, pleno aretoan, begietan zer ikusiko, eta jelkideen begiak, ertzainenak bezalakoak, beirazko kanika bizigabeak ziren.

Hala eta guztiz ere, Patxi López lehendakaritzara iritsi zenetik Ertzaintzak sorturiko liskarretan kokatu beharra dago Remiren heriotza. Aurreko hogeita hamabost urteetan PNV sortu eta elikaturiko mamutzarrak defenditzen ditu, orain, espainiar konstituzionalisten gobernua eta eragite ildoa. Eta polizia autonomikoak PNVrenak ez diren beste interesak defenditzea ez da txarra, euskal herritarron burujabetza eta askabidea zapuzteko edozein aukera baliatzea baizik. Hori da, azken batean, Ertzaintzak egun jokatzen duen papera: autogobernuaren altzoan jaio zen poliziak berak zatikatzen ditu askatasun publikoak eta kinka larrian jartzen ditu herri gisa aurrera egiteko ditugun eskubide eta aukera. Espainiaren azken aurreko lubaki errepresiboa baino ez da, ghetto barruko menpeko polizia, naziek Varsovian eratu zutenaren erakoa.

Remi Aiestaranentzat, ordea, ez dago memoria ofizialaren eremuan aipu berezirik, ez eta adierazpen instituzionalik. Remi Aiestaranentzat ez da egon ixiltasun minuturik. Remi

**Aiestaran hil eta hurrengo ordu eta egunetan hainbat alditan egon ondotik egunero igaro ginen. Lehen unetik bertoko ikurriña masta er nire baitarako- hauek behintzat odoloa dute zainetan eta bertsio o**

Aiestaranen senideentzat ez da egon minutu bakar bat albistegietan ere. Beren negar malkoek ez zuten zulatu egi ofizialaren bertsio irazgaitza. Arreta mediatikotik haratago isuri ziren. Azkenez, Remi espetxean egon beharko lukeen ANVko hautetsia zen, terrorista potentzial bat. Bere errugabetasuna frogatu behar duen horietako bat, beraz, dolurik gabeko gertakaria baino ez zen izan bere heriotza. Testuinguruak ez zuen garrantziarik.

Zorigaitzezko egun haietan Villabonako tristeziak blaitu ninduen. Gauak inoizko ilunenak ziruditen; gaueko kamioi zaborbiltzaileen harrabotsak biderkatzen zuen ixiltasunaren hormatzea; etxe atarietan jarritako Remiren argazkiek minaren serigrafiatzea ekartzen zidaten akordura. Eta halere, irribartsu gogoratzen du bere herriak Remi. Maite izan zuten hainbat herritar eta lagunek bat egin eta Remi Gogoan ekimena sortu zuten berriki. Villabona saminez bete zuen gertaera jazo eta bere omenez egin ziren ekitaldi jendetsuetan esan moduan, haren omenezko herri omenaldi bat prestatu zen udazkenean, eta herriko alkateordearen irudia eta gomuta oso present egon zen. Bere bizipozak eta konpromisoak zeharkatu zuten Errebote plaza. Bere ekarpena goraipatu zen etengabe. Herrian dioten bezala, Remi gu guztiona baita Uztailaren 31 geroztik.

**nintzen Villabonan. Guztietan manifestazioa egin zen, eta batzokiaren dian eta dolu-xingolarekin ikusteak harritu ninduen. "Kontxo -esan nuen ofizialaren gezurrari lotsa apur bat sikiera jarri diote". Oker nenbilen.**

Jende xehea erraz bereganatu eta ulertzen duen lan estiloa zuen Aiestaran zinegotziak. Ezker Abertzaleak barneratu eta zabaldu behar duen eite berekoa, jakina. Ados edo kontra egon, Euskal Herrian ez da sekretua aldaketa sakonak inork ekartzekotan, Ezker Abertzaleak ekarriko dituela: instituzioetan, herri eraketan, jendarte librea erakitzen,... Aukera guztiak ditugu zabalik, eta indarrak biltzeko unea da hau. Diskurtsoen garbitasuna baino askoz sakonagoa da, dudarik gabe, pertsonen testigantza, nork bere baitatik islatu eta ematen duena. Ertzaintzak konkistatu zituen, hainbat ordutan, Villabonako kaleak. Remik, ordea, bere herrikideen bihotza, hil aurretik bere lanari esker, eta hil ondoren ere, euren alde lanean erail zutelako. Hau bai garaipena.

Dagoeneko ez dago bistan nire etxe azpiko tabernan ipinita zegoen Remiren oroigarria. Remy Martin botila, ordea, ohiko lekuan da. Mikel tabernariaren garagardo hornitzailea beste gazte bat da. Krudeltasunik gabe, baina, denboraren joanak izozten du oroimena. Aldi berean, ispilu baten aurreran kokatzen gaitu ezinbestean: gogoratzen dugunaren zordunak gara, nonbait. Ez dadila hil gure kausa, ez dadila inoiz itzali Remiren irribarrea. Desioa lege, eragin, oroit eta borrokatu dezagun, independentzia eta sozialismoa irabazi arte.













## ABENDUAK 01

Guardia Zibilen aldetik herrian izandako gertaerak argitzeko eskatu du Leitzako udalak eta manifestaziorako deia egin du.

## ABENDUAK 01

Euskal preso politiko baten bikotea kontrol batean gelditu eta baso batera eraman du Guardia Zibilak, bertan ordu eta erdiz galdekatu duelarik.

## ABENDUAK 02

Ainara Bakedano gazte independentista espainiar Entzutegi Nazionalera aurkeztera zionean Guardia Zibilak atxilotu du. Gaua inkomunikatua igaro du eta epailearen aurrean torturak salatu ditu.

## ABENDUAK 03

Lekeitio eta Ispaster artean Guardia Zibilen kontrol batean atxikiak izan ziren sei gaztek mehatxuak eta kolpeak jasan dituzte.

## ABENDUAK 04

Orain dela bi urte eta erdi epaituak izan ondoren Leako bost gazte bosna urteko espetxera zigortuak izan dira.

## ABENDUAK 04

Asturiasera asteburu pasa joanak ziren bi euskal herritar Guardia Zibilaren kontrol batean atxikiak eta kolpatuak izan dira.

## ABENDUAK 06

Zazpigarren aldiz Ertzaintza Bilboko Alde Zaharreko herriko tabernara sartu da bertatik euskal preso politikoen argazkiak kentzera. Bertan zeuden langileak identifikatu ditu.

## ABENDUAK 06

Espainiar Entzutegi Nazionalean hamairu euskal herritar epaitzen hasi dira operazio prebentiboei loturik. Egunotan hainbat mobilizazio burutu dira Euskal Herrian.





## ABENDUAK 010

Ekai Alkorta eta Xabier Arruabarrena espetxera zigortu dituzte Parisen epaituak izan ondoren.






## ABENDUAK 015

Egunkariaren aurkako epaiketa hasi da espainiar Entzutegi Nazionalean.







## ABENDUAK 017

Ertzaintza Santutxu eta Indautxuko tabernetara sartu da euskal preso politikoen argazkiak kentzera.

## ABENDUAK 017

Frantziar poliziak hiru herritar atxilotu ditu Irrintzi taldearekin harremana izatea egotzita. Inkomunikatuak izan dira eta epailearen aurretik igaro ondoren bi libre gelditu dira eta bat espetxean sartu dute.




## ABENDUAK 018

Espainiar poliziek Xabier de la Maza atxilotu dute gazteen aurkako polizia operazio zabalari loturik.




## ABENDUAK 019

Milaka lagun bildu dira Bilbon Egunkariak libre behar duela aldarrikatzeko.

## ABENDUAK 019

Asteburu honetan egin duen eguraldiak sakabanaketaren aurpegirik ankerrena erakusten duela salatu du Etxerat elkarteak.

## ABENDUAK 021

Espainiar poliziek Urtzi Paul atxilotu dute Algortan eta espetxeratua izan da bost urteko espetxe zigorra osorik bete dezan.









## ABENDUAK 022

Igor Gonzalez euskal preso politikoa bere buruaz beste egiten saiatu da. Aurreko egunean konfidantzazko psikologoa berarekin egon zen eta espetxe medikuari ohartarazi zion arriskuaz. Honek ez zuen neurririk hartu.






## ABENDUAK 023

Anjel Lopezi azken unean euroagindua notifikatu diote eta bertan behera utzi du kanporatze arriskuaren aurka aurrera zeraman gose greba.

## ABENDUAK 024

Euskal Herriko herri eta auzo guztietan Olentzeroak eta mobilizazioak ospatu dira euskal preso politikoen eskubideak aldarrikatuz.



## ABENDUAK 025

Beste behin Irlandatik elkartasun gutunak iritsi zaizkie frantziar eta espainiar espetxeetan sakabanatuak dauden euskal preso politikoei..



## ABENDUAK 026

Aurrez 20 urte espetxean eman dituen eta jada kalean den Patxi Gomez euskal herritarrari beste hamar urtez luzatu diote zigorra.

## ABENDUAK 028

Jon Anza Kolektiboak Parisen egin duen biraren inguruko balorazioa kaleratu du. Alderdi politikoek eta komunikabideek harturiko konpromisoarekin gustora itzuli dira.





## ABENDUAK 029

Bi zarauztar gaztek jakinarazi dute ez direla agertuko hurrengo egunean espainiar Enztutegi Nazionalean dute zitaziora. Presoen argazkiak zeramatzan pankarta bat eramatea egotzi deituak izan dira bertara.




## ABENDUAK 030

Hainbat gaztek bizi duten atxilotze eta tortura arriskua salatu da agerraldi batean. Gazteen aurkako polizia operazioan torturapean buruturiko galdeketetan atera ziren gazteon izenak.



## ABENDUAK 030

Etxerat elkarteak deitu eta euskal herriko erag
le sindikal, politiko eta sozial ugarik babesturiko
manifestaldia debekatu du espainiar Entzuteg
Nazionalak. Alderdi ezberdinek bere egingo
dute dute ondoren deialdia.

# ELKARTASUN EGUNA '09

## ARRALDEN

**Iraillak 19 Larunbata**





## MAITE ZAITUZTEGU!

**11:00etan** Pala Txapelketa pilotaleku estalian.

**14:00etan** BAZKARI HERRIKOIA aterpean:

- Entsalada, saiheskia eta postrea.

**18:00etan** MANIFESTAZIOA Iturritik eta ondoren EKITALDI POLITIKOA.

**22:00etan** KONTZERTUA Gaztetxean:

- Satarrak.




**EUSKAL PRESOAK EUSKAL HERRIRA**

HERIOTZA
aski da!
ZIGORRIK EZ!

L@s pres@s con enfermedades graves a la calle

Cáncer

Colitis ulcerosa

Transtorno obsesivo compulsivo

Artrosis generalizada

Enfermedad cerebro-vascular

Cáncer

Cáncer

Amnistiaren Aldeko Mugimendua

BIZIARTEKO
aski da!
ZIGORRIK EZ!

L@s pres@s con la condena cumplida a la calle

29 Urte espetxean / Años en prisión

28 Urte espetxean / Años en prisión

27 Urte espetxean / Años en prisión

25 Urte espetxean / Años en prisión

25 Urte espetxean / Años en prisión

25 Urte espetxean / Años en prisión

25 Urte espetxean / Años en prisión

25 Urte espetxean / Años en prisión

Amnistiaren Aldeko Mugimendua

SAKABANAKETARIK EZ!
aski da!
NO A LA DISPERSIÓN

L@s pres@s Vasc@s a Euskal Herria

Sakabanaketaren ondorioak:
Consecuencias de la dispersión:

Frantziar Estatua

EUSKAL PRESOAK EUSKAL HERRIRA

Amnistiaren Aldeko Mugimendua

# ELKARTASUNA!





Euskal Herriko Amnistiaren Aldeko Mugimendua



DAGOZKIEN ESKUBIDEEN JABE

euskal presoak euskal herrira



URTARRILAREN 2an

# MANIFESTAZIO NAZIONALA

Bilbon, arratsaldeko 17:30etan Aita Donostiarik abiatuta

